UNESCO Etxea - Centro UNESCO del País Vasco
Lan Koadernoak, 4. zenbakia

# Gizarte eraldaketarako arte eta kultura arloetako hezkuntza programen ebaluazio adierazleak

## Lehen Hezkuntza

Regina Guerra, Oihane Gulin eta Teklak



# aurkibidea





**Regina Guerra (ARTikertuz, UPV/EHU)**

Regina Guerra irakasle da Euskal Herriko Unibertsitateko Hezkuntza Fakultatean (Bilbo), 2018az geroztik, eta ARTikertuz komunitate praktikoko kide ere bai, lantalde horren sorreratik. Horrez gain, komunitate horren bilakaera jaso du bere doktore tesian.

ARTikertuz 2015ren hasieran sortutako komunitate praktiko bat da, irakasleen eta ikerlarien bilgune bat, eta artearen bitartez hezkuntza jarduna hobetzea eta eraldatzea du helburu. Artean oinarritutako ikerketa lagungarri dela uste du, taldeko irakasleen abio testuingurura hurbiltzeko eta haien eguneroko jardunean gertatzen diren egoerak ulertzeko. Harreman sare bat eratu du, eskoletara ez ezik, zentroek barne hartzen dituzten hezkuntza komunitate guztietara hedatzen dena, eta, horretan, ikasleen familiaren eta inguruaren konpromisoa bultzatzen du, eskoletan garatzen diren proiektu artistikoetan. Azken urteotan, hainbat proiektu artistikotan lan egin du, eta interes berezia jarri du zentro horietako bakoitzean lortutako emaitzen dibertsitatean, bai eta zentro horien prestakuntza ereduen aldaketetan ere. ARTikertuz lantaldea GizARTE sarearen parte da, 2018az geroztik.

Harremanetan jartzeko: regina.guerra@ehu.eus

**Oihane Gulin**

Ohiane Gulinek Lehen Hezkuntzako gradua du, Hezkuntza Bereziko aipamenarekin, eta, horrez gain, Zeinu Hezkuntzaren Interpretaziorako goi mailako zikloa egin zuen. Komunikazio bitartekari lanetan aritu da, itsu-gortasuna duten haurrekin; zeinu hizkuntzaren interprete lanak egin ditu; entzumen urritasuna duten pertsonentzako laguntza teknikoen teknikari lanak era bai; eta, gaur egun, irakasle da, Euskal Eskola Publikoan. Uste osoa jarri du ikasle norbanakoaren beharretatik abiatuta ikasle ororen gaitasunak garatuko dituen hezkuntza sisteman, garapen akademikoa baino bilatzen ez duen sistemaren aurrean.

Harremanetan jartzeko: oihane_gulin@hotmail.com

**Teklak**

Teklak estudioak proiektuak abian jartzen eta finkatzen laguntzen die beren jardunaren bitartez sormena, ezagutza eta pentsamendu kritikoa sustatzen dituzten eragileei. Zerbitzu espezializatua eskaintzen du audientzien garapenean, komunikazioan, ikus-entzunezko dokumentazioan eta kulturaren kudeaketan; horrez gain, ikerketa proiektu propioak garatzen ditu, gai horiei lotuta.
Teklak estudioak tokian tokiko testuingurutik hurbil baina nazioarteko esparruarekin lotuta garatzen du bere jarduna.

Harremanetan jartzeko: iintxausti@teklak.org | aelorza@teklak.org



# HITZAURREA

2015eko urrian, UNESCO Etxeak arte hezkuntzari buruzko lehen mintegia antolatu zuen, Hezkuntza, arteak eta herritarrak lelopean. Topagune haren helburua argia zen, UNESCOren ekarpenetatik abiatuta lehen hurbilketa bat egitea arte hezkuntzara, bai eta arteek hezkuntzan duten garrantzira eta herritar kritiko eta arduratsuak izate aldera duten eraginera ere. Era berean, Kataluniako zenbait esperientzia aurkeztu ziren, esparru formaleko zein ez formaleko hezkuntza komunitateetan egindakoak; bai eta gure lurraldeko erreferentziazko ekimen bat ere, KUNARTE haur txikientzako eta berrikuntza artistikorako zentroa (Paraiso Antzerkia, Gasteiz).

Esperientzien lehen elkartruke hark jakin-mina piztu zuen, arlo horretan egiten ari zenari buruz gehiago jakiteko gogoa, metodologiei, tresnei, sistematizazio ereduei, esperientziei eta, ikuskerak partekatze aldera, profesionalei buruz gehiago jakitekoa, batez ere.

Hala sortu zen GizARTE, Gizartearen Eraldaketarako Heziketa Artistikoen Euskal Sarea. Gaur egun, hirurogeita hamar eragile inguru biltzen dira sare horretan, hezkuntza, arte eta kultura arloetako eragileak, askotariko arte diziplinatakoak eta ibilbidetakoak. UNESCO Etxeak koordinatuta, GizARTE sareak espazio emankor bat izan nahi du, gaitasunak garatzeko, ezagutzak sortzeko, proiektu komunak pentsatzeko eta eragina izateko hezkuntza, kultura eta garapen estrategietan.

Harrezkero, eta Garapenerako Lankidetzaren Euskal Agentziaren babesarekin, metodologia propioak garatu ditugu, artistek presentzia handiagoa izan dezaten ikastetxeetako eskola orduetan; gure esperientziak helarazi dizkiegu tokiko, nazioko eta nazioarteko foroei; beste latitude batzuetako artistekiko elkartrukeak erraztu ditugu; eta hainbat abagune sortu ditugu, herritarrak artearekin eta kulturarekin konektatzeko. Eta horretan, dibertsitateak, feminismoak, kultura eskubideek, jasankortasunak eta sorkidetzak bultzatzen dituzte gure ekintzak.

GizARTE sareak, horrez gain, arte hezkuntzaren esparruko ikerketa sustatzen du sarean bertan. 2018an, UNESCO Etxearen Lan Koadernoen 3. zenbakian, egoerari buruzko azterlan bat argitaratu zen, Euskadiko hezkuntza formala zein ez formala barne hartzen zituena. Azterlan horretan, ondorio hau jasotzen zen, besteak beste: *“Komenigarria litzateke sistematizazio lan bat egitea, haur hezkuntzako eta lehen eta bigarren hezkuntzako zentroek artearen irakaskuntzan garatzen dituzten metodologiekin, ikuskerekin eta jarduerekin. Era berean, komeni da zenbait adierazle diseinatzea eta eraikitzea, eta, horrez gain, emaitzak eta ikasleengan izandako eraginak jasotzea”*.

UNESCO Etxeren Lan Koadernoen zenbaki honek, beraz, gomendio horri erantzuten dio, adierazleen eraikuntzari eta lehen test bat egiteari dagokionez (Gasteizko Barrutia Ikastolan egin zen). Zergatik jarri dugu ardatza Lehen Hezkuntzan? Etapa horretan bat egiten dutelako ekoizpenaren eta hausnarketaren dimentsioek. Eusko Jaurlaritzak bere curriculum dekretuan jasotzen duenez, adin horietako ikasleek jaso egiten dituzte *sozializatzeko, identitatea eraikitzeko eta bizi garen munduari buruzko ideiak eraikitzeko prozesuetan dauden erreferentzia estetikoak. (...) eta eskatu egiten dute izaera kritikoarekin nola interpretatzen eta aztertzen diren irakastea.*

Probatu adierazle hauek, eta proposatu hobekuntzak. Gure helburua tresna ireki, dinamiko eta eraginkor bat sortzea baita, arte hezkuntzak haurren garapen pertsonalean duen eragina neurtzeko. Eta horretan lan egiten jarraituko dugu. Bihoakie gure esker ona lan garrantzitsu honen egileei.

**Begoña Guzmán**

**Eraldaketa Sozialerako Kultura**
**UNESCO Etxea - Euskal Herriko UNESCO zentroa**



# Esparru teorikoa

## *Arte* kontzeptua eta jardun artistikoa

Gure gizartean, gaur-gaurko kontuak dira zientzia eta teknologia berrikuntzak, eta zinez balioesten da hezkuntzak gizartean duen eraldaketarako eragina. Horregatik, paradoxikoa da etengabe justifikatu beharra zer ekarpen egiten dituen arte hezkuntzak edo zer egiteko duen arteak hezkuntzan, gizartean eta tartean diren eragileetan. Belaunaldi berriek aurrean dituzten erronkek estrategia berriak eskatzen dituzte, pentsaera eta ezagutza modu berriak, eta erronka horiei aurre egiteko behar-beharrezko tresna dira jardun artistikoa eta haren integrazio zein erabilera egokia, hezkuntza esparruan. Halaxe zioten Cilleruelok, Peñak eta Aberasturi-Apraizek, 2016an:

> Beharbada, gure etorkizuneko moldaketen arrakasta ez da dakigunaren mende egongo, baizik eta malgutasuna eta sormena baliatuz pentsatze eta jardute aldera garatutako gaitasunaren mende (...)Zentzu horretan, komeni da ikustea egungo jardun artistikoak testuinguru egoki-egokia eskaintzen digula gai konplexuei heltzeko, beste leku batean jartzen gaituzten ikuspegiekin. (ikus 11. or.)

Eta artea ezagutza partekatzeko eta elkarrizketarako lekutzat hartzen duen kontzeptuaren ildotik, egile askok definitu dute artea bera kultura jakin baten baitan eragiten duen sistema sinbolikoa eta ekoizpen kulturala dela esanda.

Hasteko, A. Efland, K. Freedman eta P. Stuhr irakasleek, 2003an, eztabaida postmodernoetatik ziotenez:

> (...) Artea ekoizpen kulturalaren alderdietako bat dela ulertzen da, kulturaren berezko inguruabar jakinak islatzen dituena, eta haien mendekoa. Hori horrela izanik, ez dira alde batera uzten artearen adierazpen eta formalizazio prozesuaren alderdi sozialak eta kulturalak; aitzitik, funtsezkotzat jotzen dira, eztabaida estetiko orotan. Eta artea kulturari buruzko iruzkin moduko bat denez eta hark mugatuta eta baldintzatuta dagoenez, kritika postmodernoak kritika kulturalaren itxura hartzen du. Hala, artea bere kultura testuinguruan aztertzea da kritikarien eta irakasleen egitekoa. (ikus 70. or.)

Aguirrek, 2005ean, bat egin zuen artea kultura ekoizpenaren alderdi bat dela dioen definizio horrekin, eta premia bat erantsi zuen:

> Kasuan-kasuko erakunde kulturalen eta artistikoen artean ezartzen den harreman motari arreta jartzeko premia, artea sistematizatu eta erakunde kultural bihurtu behar baita, esanguratsua izango bada. Horrek esan nahi du artearen ideia bera, eta artelanaren ideia zein artistarena, kultura sarean txertatuko badira, beste erakunde batzuekin elkarrekintzan eraiki behar direla, hala nola kritikarekin, museoekin edo arte ederretako fakultateekin, batzuk aipatzearren. (ikus 320. or.)

Eta museo eta kultura erakundeak ez dira bakarrak, artearen eta gizartearen arteko harremana ehuntzeko lanean; izan ere, ikastetxeek funtsezko egitekoa betetzen dute, arteak, konpetentzia den aldetik, ikasgelaz kanpoko bizitzari aurre egiteko gaitasunen sortzaile aldetik, berez duen garrantzia azpimarratzeko garaian:

> Artea funtsezkoa da hezkuntzan, izaki ororen sorkuntzarako berezko adierazpidearen garapena bultzatzen baitu eta gaitasun eta balio sozialak, moralak eta autoestimua akuilatzen baititu. Eta badu beste helburu bat ere, irakaslea zein ikaslea, bi-biak, bide neketsu bezain zirraragarri batean jartzea, sormenaren, sentikortasunaren, artea balioestearen eta adierazpenaren bidean, hain zuzen, alderdi horiek guztiek laguntzen baitute izaki ororen espiritu sortzailea eta soziala eratzen. (Lorena eta Verján, 2000)

Ildo beretik, artea norbanakoaren zein gizartearen adierazpen tresna gisa ikusteak lagundu egiten digu inguratzen gaituen mundua ulertzen, bai eta hura osatzen duen askotariko jendea ulertzen ere; izan ere, gure testuingurua ulertzen ez ezik, artelanak oinordetzan jasotako iraganeko ondarea direla aintzat hartzen laguntzen digu, eta, horri esker, lagungarri zaigu gaur egun nor garen definitzeko.

> Zalantzarik gabe, ondare artistikoa funtsezko baliabidea da ikasleek zer mundutan garatzen ari diren uler dezaten, artelanak beren testuinguru historikoarekin estu-estu lotutako produktuak baitira, egitate estetiko hutsa baino areago, errealitate soziohistorikoaren fruitua baitira. (ikus Cuenca, Estepa, Martín, 2011, 51. or.)

Beste alde batetik, gainera, errealitate soziohistoriko hori kritikatu eta zalantzan jar dezakete, bai artelanek eta bai aurrean duen audientziak. Hala, 1972an, Eisnerrek, artearen funtzioa zein zen bere buruari galdezka zebilela, gizarteari egindako kritika zela esan zuen:

> Egiteko hori betetzen duenean, arteak forma publikoa ematen dio pertsonala eta esanezina den zerbaiti, eta, horri esker, besteen parte hartzea ahalbidetzen du, kultura jakin baten ideiek bestela izango ez zuten esanahi kolektiboa izan dezaten. (ikus 9.-10. or.)

## Arte hezkuntza eta haren ezaugarriak

2018an, Begoña Guzmánek azterlan bat argitaratu zuen, Euskadiko gizarte eta hezkuntza esparruko arte hezkuntzari buruz, UNESCO Etxearen Lan Koadernoen 3. zenbakian. Lan horretan, *arte hezkuntza* kontzeptuaren hainbat definizio proposatzen ditu. Lana egin zenean indarrean zegoen Euskal Hezkuntza Legea oinarri hartuta -HEZIBERRI 2020-, hezkuntza sisteman duen presentzia deskribatzen du, bai eta artearen inguruko irakasgaiei loturik curriculumean proposatzen diren helburuak ere. Irakasleen egoera ere jasotzen du, arteari loturiko irakasgaietarako prestakuntza espezializatuari dagokionez, eta zenbait hezkuntza proiektu eta esperientzia biltzen eta aurkezten ditu, bai eta egun euskal hezkuntza sistemaren barruan zein kanpoan lanean diharduten zenbait erakunde artistiko eta kultural ere. Eskuetan duzun gidak gizarte eraldaketarako arte eta kultura arloetako hezkuntza programen ebaluazio adierazleak biltzen ditu, eta Guzmánen azterlana du oinarrian, elkarrekin lotzen baititu, batetik, arte hezkuntzak Euskadiko gizarte eta hezkuntza esparruan duen egoera eta, bestetik, arteak hezkuntzan duen garrantzia azpimarratzen duten teoriak.

Guzmánen hitzetan (2018), helburu hau du arte hezkuntzak:

> sentikortasuna, esperientzia estetikoa, pentsamendu sortzailea eta adierazpen sinbolikoa indartzea eta garatzea, kulturarteko testuinguruetan, adierazpen materialak zein ez materialak oinarri (izan entzumenari, ikusmenari, gorputzari edo literaturari lotuta) eta artearekin, kulturarekin eta ondarearekin erlazionatzeko ditugun moduak kontuan hartuta.

Arte hezkuntzaren definizio horrek, beraz, bildu egiten ditu Eisnerrek 1972an diziplinari lotuta proposatutako gaitasunetako batzuk, besteak beste, honako hau: “artearen bidezko ikaskuntzak zenbait gaitasunen garapenari heltzen dio, eta gaitasun horiek beharrezkoak dira forma artistikoak sortzeko, pertzepzio estetikoa garatzeko eta artea kulturari loturiko fenomenoa dela ulertzeko”. (ikus 59. or.)

Guzmánek arte hezkuntzaren beste bi ikuspuntu gehitzen ditu; UNESCOk 2003an Helsinkin emandakoak, *Regional Conference on Arts Education in Europe and North America: Cooperation over Borders* biltzarrean:

- Arte hezkuntzak berekin dakar ikasleei zenbait diziplinatako jardunbideak eta printzipioak erakustea, haien kontzientzia kritikoa eta sentikortasuna akuilatzeko, eta identitate edo nortasun kulturalak eraikitzeko gai egiteko.
- Arte hezkuntzak berekin dakar artea bidetzat hartzea, beste ikasgai batzuetako edukiak ikasteko eta hezkuntza emaitza orokorragoak erdiesteko. Beste ikasgai batzuek, beraz, arte hezkuntza baliatu beharko lukete, eta, batez ere, gizarteari eta kulturari lotutako alderdiak.

Laburbilduz, esan daiteke arteak banan-banako irakasgai moduan irakats daitezkeela, konpetentzia artistikoak lortze aldera, edo, aitzitik, irakaskuntza eta ikaskuntza metodotzat erabil daitezkeela, alderdi artistikoak eta kulturalak curriculumeko ikasgai guztien parte izan daitezen.

INSEA (International Society of Education through Arts) elkarteak 2018an egin zuen manifestuak bere egiten ditu UNESCOk emandako ikuspuntuak, baina ez hori bakarrik, azpimarratu egiten du arte hezkuntzaren denboraz gaindiko izaera, bai eta harekin harremana dutenen nortasunaren eraikuntzan duen lekua ere:

- Ikasten ari den pertsona orok izan behar luke ikusizko arteetan hezteko eskubidea eta aukera, edozein izanik ere haren adina, nazionalitatea edo aurrekariak.
- Artearen bidezko hezkuntzak arnasa ematen die kulturaren sorkuntzari, balioespenari eta ezagutzari.
- Kultura oinarrizko giza eskubidea da. Kulturak justizia soziala eta parte hartzea sustatzen ditu, gaur egungo gizarteetan. Demokrazia sendoek berekin dakartzate gizarte inklusiboak. Eta, alderantziz, gizarte inklusiboek berekin dakartzate demokrazia sendoak.
- Ikasle orok du arte hezkuntza jasotzeko eskubidea, bere munduarekin eta historia kulturalarekin lotura sendoa izan dezan. Arte hezkuntzak ikuspegi zabalagoa ematen die, eta bide berriak ematen dizkie, ikusteko, pentsatzeko, egiteko eta izateko.
- Hezkuntza programek eta ikasketa planen ereduek herritarrak prestatu behar dituzte, adimen malgu eta ziurrekin, eta hitzezko zein hitzik gabeko komunikaziorako sorkuntza abileziekin.
- Ikusizko arteetan hezteak aukera eta abagune ugari ematen ditu, ikasleak sormenaz, balioez, etikaz, gizarteez eta kulturez ohar daitezen.
- Ikusizko arteetan hezteak sorkuntzaren ikuskera jakin bat garatzen du, artea bere testuingurua kontuan hartuta ezagutzeko, ulertzeko eta sortzeko bidea ematen duena, hain zuzen.
- Ikusizko arteetan hezteak garatu egiten du modu kritikoan eta irudimentsuan pentsatzeko gaitasuna, kulturen arteko ulermena eta kultura dibertsitatearekiko konpromiso enpatikoa sustatzen eta seinalatzen du.
- Ikusizko arteen hezkuntzak sistematikoa izan behar luke, eta zenbait urte hartu beharko lituzke, garapen prozesu bat baita. Ikasleek ‘egiteko’ konpromisoa hartu behar dute, arteari buruzkoak ikastearekin batera.
- Ikusizko arteetan hezteak alfabetizatze eta jarrera estetiko sorta zabala garatzen du, ikuspuntu nagusia ikusizko alfabetizatze eta balioespen estetikoan jarrita.
- Alfabetizatze estetikoa funtsezko abilezia da gaur egungo munduan. Sustatu egiten ditu ikusizko komunikazioaren


balioespena eta ulermena, bai eta modu kritikoan aztertzeko eta irudi esanguratsuak sortzeko gaitasuna ere.

- Arteak abilezia askoren hobekuntza sustatzen du, eta abilezia horiek curriculumeko beste arlo batzuen ikaskuntza hobetzeko erabil daitezke.
- Ikusizko arteak lagungarri dira ikastetxeetan, ikasleek beren burua ezagutzeko, beren buruarengan konfiantza eta autoestimua sortzeko, eta nork bere ongizatea modu esanguratsuan hobetzeko. (INSEAren manifestua, 2018)

**Arteak hezkuntzan duen egitekoaren justifikazioa**

1972an, Eisnerrek bi motatan laburbildu zituen arteak hezkuntzan duen garrantzia azpimarratzen duten justifikazioak.

- Justifikazio *kontestualistak* arteak lanean dituen ondorio instrumentalak azpimarratzen ditu, eta ikasleen edo gizartearen behar konkretuak baliatzen ditu bere helburuei forma emateko oinarri nagusitzat.
- Justifikazio *esentzialistak*, bestalde, gizakion esperientziari eta ezagutzari arteak soilik eskain diezaiokeen laguntza azpimarratzen du, arteak berezko eta berdingabe duena, alegia. (ikus 2. or.)

Egileak dioenez, justifikazio kontestualista abiapuntutzat hartuz gero, hezkuntza programa bat behar bezala zehazteko modu bakarra dago: “programa horrek funtzionatuko duen testuingurua ulertzea, eta testuinguru horren baitan aintzat hartzea bai ikasleen ezaugarriak eta bai gizartearen gehiengoaren beharrak”. (ikus 2. or) Horrenbestez, egungo arte hezkuntzako programek zer helburu eta eduki izan behar lituzketen galdetzen diotenean, egileak dio ikuspuntu kontestualistaren arabera erantzuteko kontuan hartu behar dela “ikasleak nor diren, komunitateak zer behar dituen edo gizartearen gehiengoak zer arazori aurre egiten dien”. (ikus 3. or.) Justifikazio esentzialistek, bestalde, “artea kulturaren eta giza esperientzien alderdi berdingabea dela diote, eta bere berezko balioak eta ezaugarri espezifikoak direla arteak giza esperientziari egin diezazkioekeen ekarpen baliotsuenak”. (ikus 5. or)

**Ikaskuntza artistikoaren  ezagutza bereizgarria**

Arteak hezkuntzan duen presentzia definitu eta justifikatu eta gero, ikaskuntza artistikoak berekin dakarren ezagutza bereizgarria definitzen da. Ricardo Marinek 2003ko Didáctica de la Educación Artística para Primaria lanean dioenez, hiru ezaugarrik definitzen dute ezagutza hori:

> Pentsamenduaren **ikusizko eta sormenezko** alderdiak (…)edozein garaitako eta edozein materialetako irudiak prestatzea eta sortzea du bere egiteko bereizgarria, bai eta gertaeren ezaugarri materialak eta ikusizkoak bereiztea ere.

Bistakoa denez, arte hezkuntzaren xedea **artistikoa eta estetikoa** da.  Artearen eta estetikaren lurretan murgiltzea ez da zaila, baina horretarako joera eta jarrera irekia izatea eskatzen du, mundua sentitzeko eta esperimentatzeko zein geure burua aurkitzeko modu bereizgarri horren aldeko jarrera izatea, alegia, eta berekin dakar gure eguneroko esperientziaren norabidea nolabait aldatzea, interes praktikoek eta funtzionalek bideratua izaten baita gehienetan.

Ezagutza artistikoaren funtzioa **irudimentsua eta emantzipatzailea** da. Artearen esparruan, gizakien bizi esperientzia da gehien interesatzen zaiguna, eta, batez ere, intentsitate handiagoz gogoberotzea, desiratzea, ezagutzea eta sentitzea eragiten diguten egoerek eragindakoa. (ikus 15.-16. or.)

Beste alde batetik, Guzmánek 2018ko txostenean azpimarratzen duenez, arte hezkuntzak hiru dimentsio ditu, eta ikasleek hiru dimentsio horien bidez lortzen dituzte ezagutzak:  1) objektu edo aurkezpen artistikoekiko, artistekiko eta irakasleekiko elkarrekintzaren bidez; 2) norberaren jardun artistikoaren bidez; eta 3) ikerkuntzaren eta ikaskuntzaren bidez (artearen forma jakin bat eta arteak historiarekin duen lotura gaitzat hartuta).[1]

**Arte hezkuntzaren egitekoa, gizarte eraldaketan**

Imanol Aguirrek, 2005eko Teorías y prácticas en Educación Artística lanean (Ernesto Hernándezek egindako hitzaurrean jasotzen denez), “ikusizko adierazpenek jarrera subjektiboen eraikuntzarekin duten loturan pentsatzea eta hura esplotatzea” proposatzen du, “aukera ematen baitu galderak, kritika, inplikazioa eta egunerokotasuna ikastetxeetara eramateko”. (ikus 17. or) Eta horretarako, zenbait argibide ematen dizkigu:

> Artearen ekintza ez da gauzatzen gizartearen harreman sarean, baizik eta banakoek beren komunitateko berezitasunekiko duten ikuskeran, kontzientzia hartzean eta sentsibilizazioan, eta horrek tresna sinbolikoak ematen dizkie, haietan eragina izateko eta harekin identifikatzeko. Beste modu batera esanda, arteak, beste kultura erakunde batzuek bezala, ez du eragin zuzenik politikan edo gizartearen egikeran; aitzitik, pertsonen sentikortasuna aberastuz eta dibertsifikatuz eragiten du. (ikus 336. or.)

Eta hori gerta dadin, hezkuntza eta kultura zentroek kontuan hartu behar dute zein den arte hezkuntzaren helburua:

> Gu nortasunez hornitzea, nahiz eta esan beharra dagoen nortasuna edo identitatea aipatzen dugunean ez dugula aipatzen “a priori” definitzen gaituen ezaugarri pertsonalen eta kulturalen multzoa, baizik eta, sorkuntza lan baten aurrean gauden aldiro (izan guk edo izan beste norbaitek egina), geure buruaz, gure esperientziez, gure kontingentziez eta gure

1 Arte Hezkuntzarako bide orria, UNESCO, Lisboa, 2006.

iraganaz egiten dugun berrirakurketa. Arte hezkuntzaren bidez lortu nahi dena, beraz, arteak geure buruaz mintzaraztea da, urratsez urrats geure burua aurkitzea eta gure nortasuna definitzea, ez aurrez zehaztutako eredu baten arabera erdietsitako betiereko lorpen moduan, etengabe landu beharreko zerbait balitz bezala baizik, "benetan garen horretaz" mintzaraztea, alegia. (ikus 336.-337. or.)

**(H)ABIAN 2030, estrategia de educación para la transformación social**

Aurreko ataletan arte hezkuntzari buruz esandako guztiarekin lotuta eta (H)ABIAN 2030en eskutik, hots, Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzaren euskal estrategiaren eskutik (GEH), azaldu beharra dago zer aldaketa premia duen gizarteak.

Bere hitzetan:

> Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzaren Euskal Estrategia (GEH) Garapenerako Hezkuntzaren (GH) ondorengo estrategia da zuzenean. GHa, nolanahi ere, erakunde publikoek bultzatu dute hainbat hamarkadatan, honako hauek sustatzeko: (i) planetako justiziarik ezaz eta desparekotasunaz jabetuta egongo diren herritar kritikoak; eta (ii) aldaketa indibidualak eta kolektiboak sortuko dituzten jardunbide ekitatibo eta solidarioak. Azken hamarkadetan egindako ibilbidea aberasgarria izan da eta ikasteko aukera asko eman ditu.

Garapenerako Hezkuntza etengabe aldatzen ari da; izan ere, ez dute era berean ulertzen gizarteko eragile guztiek. (H)ABIANetik, eraldaketa horren bost belaunaldi bereizi azaltzen dizkigute[2]:

| | |
|---|---|
| **Lehen belaunaldia** | Geroago GH deituko zitzaionaren aurrekariak izan ziren, eta karitate eta laguntza izaera zuten sentsibilizazio jardunbideak. |
| **Bigarren belaunaldia** | GHaren hasiera. Garai hartan nagusi zen ereduari jarraitu zion, eta ikuspegi desarrollista bat izan zuen. |
| **Hirugarren belaunaldia** | GHak ikuspegi eta posizionamendu kritiko eta solidarioak gaineratu zituen. |
| **Laugarren belaunaldia** | GHak giza garapen eta garapen jasangarriaren ikuspegia zuen. |
| **Bosgarren belaunaldia** | GHak herritartasun golbalaren eraikuntza planteatzen du, eta Hezkuntza Global izenekoarekin lotuta dago |

Gaur egun, zaila da Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzaren belaunaldi berria nolakoa den definitzea, alabaina, (H)ABIANek zenbait adostasun orokor hauteman ditu, zer den eta zer erronkari erantzun nahi dien zehazteko:

> Nabaria da aldaketa eta eraldaketa premiazkoa dela, ardatz gisa merkatuak jartzen dituen globalizazio sistemak eta mendebaldeko gizonengan eta harreman heterosexualetan oinarrituta dagoen gizarte ereduak sortzen dituzten desparekotasunei eta bidegabekeriei aurre egiteko.

2. GH: Garapenerako Hezkuntza

Jarraian, egungo Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzak dituen ezaugarrietako batzuk laburbiltzen dira, (H)ABIANen gidan ageri diren bezala:

> **1. Tokiko-global ikuspegia:**
>
> Beharrezkoak dira honako hauek: (1) ikuspegi berri bat; kultura, gizarte, klase, genero, sexu orientazio, sinesmen eta gaitasun funtzionalen inguruko aniztasunak eta haietako bakoitzak mundu jasangarriago eta ekitatiboago bat sortzeko egiten duen ekarpena aitortu behar dira (ikuspegien dekolonialitatea); (2) gure errealitatea, gure bizimodua eta mundua ulertzeko dugun modua bakarra, zuzena eta onena delako ikuspegiekiko haustura (ikuspegi etnozentrikoak); eta (3) erreferentzia bakar gisa harremanak eta gizartea ulertzeko modua (gizonen eta emakumeen arteko harreman heterosexualean oinarritua) duten ikuspegiekiko haustura (ikuspegi heteronormatiboak).
>
> Horrek guztiak desberdintasuna aberastasuntzat hartzera eta, era berean, aniztasuna gureak aberastu eta osatzen dituzten jakintzak, jardunbideak eta harremanak ikasteko eta ezagutzeko gunetzat hartzera eramaten gaitu.
>
> **2. Ikuspegi politiko pedagogikoak eta haien aplikazio praktikoa**
>
> Ikuspegi politiko pedagogikoak (metodologikoak) funtsezkoak dira hezkuntzak haren bidez lortu nahi dituen eraldaketak ekartzeko. (...)Hezkuntza prozesuek irakatsi eta ikasteko prozesu izan behar dute eta, prozesu horietan, hezten duenak ikasi egin behar du irakastean, eta hezten direnek irakatsi egin behar dute ikastean. (…)Edonola ere, errealitate aldakorra zalantzan jartzeko prozesuak eta bilaketa eta posizionamendu prozesuak izango dira.
>
> Ikuspegi eta metodologia horiek eragina izateko, pertsona eta kolektiboen errealitateari, premiei eta interesei lotuta egon behar dute testuinguru jakin bakoitzean. Halaber, elkarrizketa, gogoeta eta jakintzen eta jardunbideen sorkuntza sustatu behar dute kolektiboen eta hurbileko pertsonen artean eta desberdinak diren eta beren desberdintasunetatik abiatuta ekarpenak egin ditzaketenen artean.
>
> Ikuspegi politiko pedagogikoak: alde batetik, aniztasunen kudeaketa eta gatazken maneiua lantzen duten ikuspegirik tradizionalenak daude, hala nola ikuspegi kritikoak, parte hartzean oinarrituak eta sozioafektiboak; bestetik, giza eskubideen ikuspegia eta kulturarteko ikuspegia, garrantzi eta agerpen handiagoa izan dutenak azken urteotan; eta, azkenik, ikuspegi feministak eta bizitzen jasangarritasunaren ikuspegiak.
>
> **3. Subjektu eta agenteen aniztasuna**
>
> GHaren hasieran agente nagusiak GGKEak[3] baziren ere,

3. Garapenerako gobernuz kanpoko erakundeak



gaur egun hainbat leku geografikotako eta hainbat eremutako (hezkuntza, etxebizitza, osasuna, feminismoa, ekologia, sexu aniztasuna, aniztasun funtzionala, migrazioa, kontsumo arduratsua eta abar) subjektu ugarik lantzen dituzte batera GEHa eta haren erronkak.

GEHaren bidez lortu nahi denaren definizioari buruzko eztabaida sortu da: lortu nahi diren eraldaketen protagonistak izango diren subjektuak, subjektu politikoak, kolektibo emantzipatzaileak, subjektu indibidualak eta kolektiboak.

Ohiko GGKEez gain, hezkuntza komunitatea, Berritzeguneak, unibertsitateak, komunikabideak, gizarte mugimenduak, kolektibo feministak, ekologistak, baztertutako herrietako kolektiboak, migratzaileen kolektiboak eta abar ditugu. Gizarte zibileko entitateen lanaz gain, hezkuntza prozesu horietan zeregin bat bete behar duten erakunde publikoen inplikazio handiagoa behar da.

**4. Sareko lan egituratua**

Gizarte eragileekin batera konfiantza lortzeko eta herritartasuna sortzeko harremanak lotuko dituen hezkuntza erakunde baterako urratsak egiteko erronkari egin behar diote aurre administrazioek –oro har– eta politikari eta teknikariek –bereziki–.

## Arte hezkuntza, gizarte lankidetzarako esparrua: arte eta kultura hezkuntzako ekimenak, Euskadin

Guzmánek zenbait sinergia sortzea proposatzen du bere 2018ko azterlanean, eta, horretarako, lankidetza mota hauek zehazten ditu:

MINISTERIOAK, HEZKUNTZA SAILA edo UDALAK (Estatuko Kultura eta/edo Hezkuntza ministerioak, erkidegoko Hezkuntza Saila eta Udal erakundeak):
Harreman mota honen bidez, ikastetxeen eta erakunde kulturaren arteko lankidetza lortu nahi da, eta artea eta kultura hezkuntzaren elementu nagusiak izatea, bigarren mailako  elementu curricularrak izan beharrean.

IKASTETXEAK
Egungo testuinguruan, badakigu  ikasketa prozesua ez dela mugatzen ikastetxean gertatzen den horretara. Lankidetza harremanak egin dira ikastetxeen eta kultura erakundeen artean, eta, horretan, aukera pedagogiko berriak sortu dira. Bai kultura erakundeen eta bai ikastetxeen laguntza eta konpromiso zintzoa ezinbestekoak dira, lankidetza horrek arrakasta izan dezan.

IRAKASLEAK
Ikastetxeetako proiektuek artisten, irakasleen eta ikastetxearen arteko lankidetza barne har dezakete, ikasleen adina, irakaskuntza metodoak eta eskolako jardunaren iraupena kontuan hartuta.

Jarraian, esperientzia artistikoen funtsezko oinarritzat hezkuntza eta bitartekaritza dituzten Euskadiko ekimen eta proiektu ugarietako batzuk aipatuko ditugu. Ekimen horien guztien artean askotariko diziplinak daude (antzerkia, zinema, arte plastikoak, arkitektura eta diseinua, musika, literatura, ikusizko arteak, maker kultura, hibridazio artistikoko esperientziak, zeharkako proposamenak...), bai eta askotariko audientziak ere; dena den, joera handiagoa sumatzen da haurrekin eta gazteekin modu desberdinen bidez lan egiteko, izan tailerren bidez, antzezlanen bidez, lankidetzazko sorkuntzaren bidez edo jaialdien bidez.

Esan bezala, beraz, Euskadiko hezkuntza formalean zein informalean gauzatutako zenbait proiektu artistiko laburbilduko ditugu.

PARAISO ANTZERKI PROIEKTUA

Paraiso antzerki proiektuak 40 urteko ibilbidea du, eta finkatutako kultura egituratzat definitzen du bere burua. Esku hartze proiektu globala garatzen du, antzerkiari, haurrei eta arte hezkuntzari lotuta, eta etengabe dihardu audientziak sortzen eta hezten.

ZIENTZIAPOLIS

Zientzia garbien zein gizarte zientzien bidez eta norberaren garapen osoa lortze aldera, abileziak eta konpetentziak garatzen laguntzen duen hezkuntza gune bat da. Aisia oinarri hartuta, osoko ikaskuntza prozesu bat gauzatzen du, metodologia parte hartzaile eta ludiko baten bidez, bai eta espazio inklusibo baten bidez ere.

DETALLERES

Adierazpen berdingabea eta elkarlanerako indarra erdietsi nahi ditu, norberaren eta taldearen potentziala sentitzen laguntzen duten dinamiken eta jardueren bidez, sormenetik, arkitektura sozialetik eta ipuinetatik abiatuta.

BILBAO FORMARTE – DESGAITASUNAK DITUZTEN PERTSONENTZAKO ZENTROA

BILBAO FORMARTE zentroak, sorkuntza artistikoaren bidez, desgaitasun psikiko eta/edo intelektuala duten pertsonentzako garapen pertsonaleko programa bat eskaintzen du, kolektiboa gizarteratzeko eta laneratzeko helburuarekin. Arte plastikoen arloan lan egiten du, nork bere obra garatu, artearen bidez hezten jarraitu eta sormena areagotu dezan, ikaslеei maila artistikoan zein pertsonalean hazteko eta garatzeko aukera emanez.

ARTEMISA GUNEA – AISIALDIKO ARTE HEZKUNTZA

Aisialdian –bai eta beste testuinguru artistiko eta hezitzaile batzuetan ere– arte hezkuntza integrala eta osoa garatu ahal izateko gune bat da, hezkuntza formalari eta hazkunde pertsonalari laguntzeko balio duena. Helburua



pertsona sortzaile eta kritikoagoak sortzea da, eta, arteek gizartean duten presentzia zabaltzeaz gain, hezkuntza eta eraldaketa tresna gisa duten balioa azpimarratzea.

ARTgia- SORGUNE ARETOA

ARTgia proiektu bizia da; elkartrukea, elkarrizketa eta esperimentazioa sorrarazten ditu, sormena oinarri eta sorkuntza garaikidea jomuga hartuta. Sorkuntzarako baldintza egokiak eskura jartzea du xedea. Eta, gune gisa, hainbat proposamen artistikoren arteko hibridazioa aktiboki sustatzen du, izan proposamen indibidualak edo kolektiboak, hainbat esparrutatik.

TIPI, ERALDAKETARAKO DISEINUA

TIPIn, diseinua baliatzen dute pertsonen bizi baldintzak hobetzeko eta haien gaitasunak zein trebetasunak indartzeko soluzioak sortzeko tresna gisa. Pertsonekin, komunitateekin eta lurraldeekin lan egiten dute. Bitartekaritzan, baterako sorkuntzan eta zerbitzu eta espazioen diseinuan aritzen dira.

ARTikertuz

ARTikertuz hezkuntza komunitate bat da, 2015. urtearen hasieran sortua, Euskal Herriko Unibertsitateko ELKARRIKERTUZ ikerketa taldearen bultzadarekin. Irakasleen eta ikertzaileen topagune da, eta artearen bidez hezkuntza jarduna hobetzea eta eraldatzea du helburu. Arteek gizarte eraldaketarako duten potentziala aldarrikatzen du, ez hausnarketa kritiko diren aldetik dutena bakarrik, ekintzarako eta abian jartzeko duten gaitasunagatik ere bai. Uste du ikastetxeek modu konplexuagoan hel diezaioketela arteari, eta, are, hala heldu beharko lioketela.

SAN FELIX IKASTETXEA (ORTUELLA)

Duela urte batzuetatik hona, hezkuntza espazio berriak diseinatzeko proiektu bat garatzen ari dira, ikasleen konpetentziak garatzeko, beharrizan berrietara egokituta, proiektukako lana, taldekideen arteko elkarreragina eta norbanako bakoitza izaki bakar eta errepikaezin gisa errespetatzea sustatzen duten metodologiekin.

CARMELITAS SAGRADO CORAZÓN IKASTETXEA (GASTEIZ)

Ikasleen hezkuntza integrala du helburu, hezkuntza pertsonalizatua, haien gaitasunak eta konpetentziak ahalik eta gehien garatzea helburu duena, eta, horretan, askotariko adimenak lantzen ditu.

ARTXANDAPE IKASTOLA (BILBO)

Ikastetxearen metodologiari dagokionez, ikaskuntza esanguratsuaren aldeko apustua da, eta ikasleak dira beren garapenaren protagonista, autonomiaz eta gaitasun guztietan lan eginda (kognitiboak, afektiboak, adierazkorrak, motorrak eta sozialak). Taldeko lana koordinaziorako, lankidetzarako, ikaskuntzarako, eraginkortasunerako eta gogobetetasunerako funtsezko elementutzat du, baita aniztasunaren ikaskuntza integratzailea ere.

MAGNET PROIEKTUA (GASTEIZ)

Ikastetxeen eta kultura eragileen arteko lankidetzaren adibide gisa, Gasteizko Barrutia Ikastolan Gasteizko Artium Museoaren laguntzarekin gauzatutako MAGNET proiektua labur-labur deskribatuko dugu.[4]

Aipatu behar da Barrutia Ikastolak, proiektuaren baitan, dokumentu honetan aurkezten den adierazleen gida testatu duela. Jarraian aurkezten den deskribapen laburtua proiektuan parte hartu duten eragileekin 2019/2020 ikasturtean egindako lan bilera batetik atera da.

MAGNET zeharkako proiektua da, eta ARTIUM museoko sail guztiek lan egin dute hartan, ez museoaren hezkuntza sailak bakarrik. MAGNET proiektu pilotua Bartzelonako MACBA museoan egin zen (desberdintasun nabarmen batzuekin, kataluniarren kasuan ikasturte osoa izan baitzuten zer egin nahi zuten hausnartzeko).

Eusko Jaurlaritzaren bultzada (ez du baliabide ekonomikorik eman, baina ikastetxeko proiektuaren koordinatzaile lanpostuak berekin dakarren gastua bere gain hartu du) eta Gasteizko Udalaren laguntza izan ditu (15.000 euro, 2019an gauzatzeko), “Hiri Hezitzaileak” programaren esparruan, eta horrek lehen garapen bat eta mugarri bat ahalbidetu ditu, joan den abenduan.

Ikasle guztiek, txiki zein heldu, astean ordubete eskaintzen diote proiektuari, honako lantegi hauetan lan eginez:

- Hitzak (4., 5. eta 6. mailetako ikasleak). Nahi bat hitzez adieraztea da: non gauden, zer nahi dugun, nora goazen eskolako komunitate garen aldetik (ikasleek ez ezik, gurasoek eta irakasleek era parte hartu dute lantegi honetan). Barrutik sortzen da.
- Musika (1., 2. eta 3. mailetako ikasleak). Musika elektronikoan diharduten musikariekin lankidetzan egindako lana da. Horri esker, ikasleentzako esperientzien lantegi batzuk sortu dira, hainbat teknika balia ditzaten adierazpide moduan.
- Filma (4., 5. eta 6. mailetako ikasleak). Ekoizpen artistikoari eta erretratuen ekoizpenari lotuago dagoen lana da (izan erretratu horiek norbanakoarenak edo izan partekatuak). Ikasleen auzoak eta testuinguruak erakusten ditu.

Bukatzeko, garrantzitsua da hezkuntza eremu formalaren eta ez formalaren arteko lankidetzaren beharra ja-

4. Ikastetxe batekin egindako koordinazio bilera batean ateratako informazioa.


sotzea. Eskola da arteak irakasteko espazio tradizionala; baina arte hezkuntza ez formala ere (GKEak, elkarteak, museoak, kultura zentroak, etab.) pertsonen prestakuntzaren parte da, eta aniztasuna ematen dio arte eta hezkuntza esperientziari. Hori horrela izanik, bi sistemen arteko artikulazioa eta lankidetza sustatu behar dira.

Sareko lana ere behar-beharrezkoa da arte hezkuntzak gure gizartean egiten duen lana bistaratzeko. Premia hori asetzeko, hainbat sare eratu dira, hala nola KARRASKAN (Euskal Autonomia Erkidegoan berrikuntza eta berrikuntzaren kultura sustatzeko elkarte profesionala), GizARTE (UNESCO Etxearen Gizarte Eraldaketarako Hezkuntza Artistikoaren Euskal Sarea) eta A PLATAFORMA (emakumeak artearen sisteman modu normalizatuan sartzeko euskal kolektiboa). Sare horiek aukera ematen dute indarrak batzeko, proiektu komunak sortzeko, baliabideak partekatzeko, metodologiei, ikuspegiei, erreferentziazko erakundeei, harremanei, prestakuntzari, hezkuntza programei, hedapen foroei eta abian jartzeko eta garatzeko laguntzei dagokienez.

## Arte hezkuntzari loturiko konpetentziak, lehen hezkuntzan, Heziberri 2020 curriculum ereduaren arabera[5]

Behin arte hezkuntzak zer garrantzi duen azalduta eta Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzaren alderdi bereizgarriak definituta, labur-labur azalduko dugu nola definitzen duen konpetentzia artistikoa Oinarrizko Hezkuntzarako egungo curriculumak (236/2015 Dekretuaren II. eranskinak osatzen duen curriculum orientatzaileak).

Egungo dekretuaren arabera, honako hau lortzen da arte hezkuntzaren bidez:

> Hainbat kultura eta arte adierazpen ulertzea eta modu kritikoan balioestea, hainbat denbora eta erabilera testuingurutan, faktore estetikoek pertsonen eta gizarteen bizitzan duten garrantziaz jabetzeko. Era berean, arte hizkuntzak ezagutzea, eta haien kodeak erabiltzea arte mezuak ekoitzi eta nork bere burua ekimenez, irudimenez eta sormenez adierazi eta komunikatzeko.

Garrantzitsua da ulertzea HEZIBERRI ereduak konpetentziak dituela lanaren oinarri, eta konpetentzia horiek bi kategoriatan banatzen direla, zehar konpetentziatan eta diziplina barneko konpetentziatan, hain zuzen. Zehar konpetentziak bizitzako alor eta egoera guztietan arazoak eraginkortasunez konpontzeko behar direnak dira, izan diziplina arlo guztiekin loturiko egoeretan nahiz eguneroko bizitzari loturiko egoeretan behar direnak, alegia. Hauek dira zehar konpetentziak: hitzezko eta hitzik gabeko komunikaziorako eta komunikazio digitalerako konpetentzia; ikasten eta pentsatzen ikasteko konpetentzia; elkarbizitzarako konpetentzia; ekimenerako eta espiritu ekintzailerako konpetentzia; eta, azkenik, norbera izaten ikasteko konpetentzia. Diziplina barneko konpetentziak, bestalde, diziplina arloren batekin erlazionatutako baliabide espezifikoak mugiaraztea eskatzen dute bizitzako alor eta egoeretan arazoak eraginkortasunez konpontzeko behar direnak dira. Multzo horretakoak dira: hizkuntza eta literatura komunikaziorako konpetentzia (hizkuntzak eta literatura); matematikarako konpetentzia (matematika); zientziarako konpetentzia (natura zientziak); teknologiarako konpetentzia (teknologia); konpetentzia sozial eta zibikoa (gizarte zientziak); arterako konpetentzia (plastikako eta ikusizko hezkuntza, musika eta dantza); eta konpetentzia motorra (heziketa fisikoa).

Heziberri 2020k honako osagai hauek bereizten ditu arterako konpetentzian:

1. Hizkuntza artistikoak adierazteko eta komunikatzeko baliabideak direla ulertzea, haiek norberaren arte ekoizpenetan erabiltzea, eta hizkuntza horiek obra artistiko eta kulturaletan identifikatzea.
2. Arte produktuak era pertsonal eta arrazoituan sortzea hainbat egoera eta bizi esparrutan, emozioak, bizipenak eta ideiak adierazteko, irudikatzeko eta komunikatzeko.
3. Dagozkien denboran eta kulturan interpretatzea arte adierazpenak eta ekoizpenak, eta horietan dauden funtzioak eta erabilerak aztertzea eta bereiztea, pertsonen bizitzan duten esanahia eta eragina ulertzeko.
4. Gogoetaren eta kritikaren bidez balioestea ondare artistiko eta kulturaleko elementuak, herrien nortasunaren eta kulturen oinarri diren aldetik, herrien arteko hartu emanaren, kulturen arteko elkarrizketaren eta esperientzia partekatuen harian.

Eta gida horrekin jarraituz, hau da adierazten dena arterako konpetentziak hezkuntzan dituen ezaugarriez eta barne hartzen dituen ikasgaiez:

> Kultura adierazpenak ezagutu, ulertu, estimatu eta kritikoki balioesteko, adierazpen horien eta gizartearen adierazpenaren garaiko pentsamoldearen eta aukera teknikoen arteko harremanak identifikatu behar dira, edo bestela, adierazpenaren eta hura sortu duen pertsonaren edo taldearen artekoak. Arterako konpetentzia duenak kultura bizitzan parte hartzeko interesa adierazi behar du, ahalmen estetikoa landu behar du, eta norberaren komunitatearen eta beste komunitate batzuen kultura eta arte ondarea zaintzen lagundu.
>
> Ikasgelan landu behar dira artearen erabilerak, eta arteak, gizakien kultura produkzioan txertatzen den aldetik, bizitzearen esperientziarekin duen lotura zuzena erakutsi behar da, mitifikazioetatik eta esentzialismoetatik harago. Horrela jokatu behar da gure kulturan artearen eta

5. Heziberri 2020: oinarrizko hezkuntzako curriculumaren ikuspegi orokorra

pertsonen bizitzaren artean sortu den distantzia handia apurtzeko.

Azkenik, arterako konpetentziak errealizazio pertsonal, akademiko, sozial eta profesionalaren bidea urratzen laguntzen die ikasleei, konpetentzia horren baitan sartzen baita sentsibilitatea, esperientzia estetikoa eta pentsamendu sortzailea lantzea, eta proiektuetan beste diziplina batzuekin elkarrekintzan aritzea, gainerako oinarrizko konpetentziak lantzen diren bitartean.

Curriculumaren arabera, arte modu guztiak pertsonen ideien, sentimenduen, sinesmenen eta jarreren adierazpenak dira, gizabanakoen eta taldeen nortasunak agerian uzten dituzte eta, aldi berean, forma ematen diete.

Gizarte eraldaketarako arte eta kultura arloetako hezkuntza programen ebaluazio adierazleak Lehen Hezkuntzan aplikatzekoak dira, eta etapa hori Oinarrizko Hezkuntzaren parte denez, derrigorrezkoa eta doakoa. Etapa hori 6 urtetik 12 urtera bitarteko haurrek egiten dute normalean, eta bi ziklotan biltzen da; lehen zikloa lehen, bigarren eta hirugarren mailek osatzen dute; bigarren zikloa, aldiz, laugarren, bosgarren eta seigarren mailek. Curriculumak gogorarazten digunez, ikasle horiek aldaketa prozesu garrantzitsuen aldi batean daude, bai artefaktuen sortzaile gisa eta bai erabiltzaile gisa dihardutenean:

Arretaz zaindu behar dira aldaketa prozesu horiek haurtzarotik preadoleszentziara igarotzerakoan, distortsiorik eta etenik sor ez dadin ikaslearen erreferente estetiko bisualen eta musikalen eta eskola kulturako erreferenteen artean. Ondorioz, bizi duten kultura ulertzen lagundu behar die eskolak ikasleei; horretarako, kulturarekiko harremanak landu behar dira, ikasleek irizpide baliagarriak lan ditzaten eta zentzu kritikoa gara dezaten.

Adierazi behar dugu, era berean, dimentsio gogoetatsu hori ez dela inola ere ulertzen sorkuntza lanetik isolatuta edo horren ordezko gisa, bereziki Lehen Hezkuntzan; izan ere, neska-mutilak prozesu aldakor eta oso delikatu batzuetatik igarotzen dira ekoizle gisa, eta arretaz gainbegiratu behar dira prozesu horiek, behar adina laguntza eta bitartekaritza prozesu bideratuz, urte horietan goizegi utz ez diezaioten sorkuntza lantzeari.

Lehen Hezkuntzan, ikasle guztiek ikasi beharko dute Arte Hezkuntza, ziklo horretako sei mailetan. Arau orokor gisa, Lehen Hezkuntzako arlo guztietan eskolak emateko konpetentziak dituen irakasle bakar batek irakatsiko ditu arlo guztiak, eta taldeko tutorea izango da, ikastetxearen antolaketak horretarako aukera ematen badu. Musika, gorputz hezkuntza eta atzerriko hizkuntza irakasteko, berriz, dagokion espezializazioa edo kualifikazioa beharko da.

Etapa honetan, ekoizpenaren eta hausnarketaren dimentsioak uztartzen dira, ikusizko eta musikazko erreferente estetikoen inguruan. Arte hezkuntzari astean 2 eskola ordu inguru eskaintzen zaizkio, ikasturte bakoitzean.

| **Lehen Hezkuntza** | **1. maila** | **2. maila** | **3. maila** | **4. maila** | **5. maila** | **6. maila** |
|---|---|---|---|---|---|---|
| **Arte Hezkuntza** | 2 ordu | 2 ordu | 1.5 ordu | 2 ordu | 1.5 ordu | 1.5 ordu |

Argibide gisa, OHCak[6] arterako konpetentzia eskuratzeko garrantzitsutzat jotzen diren egoeren adibide batzuk aurkeztuko ditugu:

**Eremu pertsonalean,** kontuan hartu behar dugu ikasleak sentikor direla beren objektuen eta entzuten duten musikaren bidez, haien aisian eta eguneroko bizitzako hainbat esparrutan adierazten diren kezka eta esperientzia estetikoekiko, eta horiek guztiek lotura handia dutela beren nortasuna egituratzeko prozesuarekin.

**Eremu sozialean,** kontuan izan behar dugu ikasleek irudi eta soinu euskarriko produktu ugari kontsumitzen dituztela. Baliabide artistiko horien erabilera lehenetsi behar dute proposatutako egoerek, eta adierazpen askatasuna, kultura dibertsitatea eta esperientzia partekatuak balioesteko bide eman behar dute.

**Eremu akademikoan,** Lehen Hezkuntzako ikasleak arte produktuen ekoizle eta haien erabiltzaile edo hartzaile izaten dira, eta etapa horretan, aldaketa handiak izaten dituzte ikuspegi batetik zein bestetik. Ekoizle diren aldetik, jolasean gozatzetik ia ezer ez ekoiztera igarotzen dira, eta erabiltzaile diren aldetik, berriz, nabarmen handitzen dute haien erabilera, modu akritikoan askotan. Horrenbestez, lehentasunez bultzatuko da, besteak beste, interpretazio kritikoak egitea, balio kulturalak balioestea, ekintza artistikoen eta estetikoen artean erlazio konplexuak ezartzeko gauza izatea, norberaren esperientzia estetikoei buruzko gogoeta egiteko gai izatea, eta arteek nortasuna egituratzeko duten potentzialtasunaren gainean hausnartzeko gaitasuna izatea.

**Lan eremuan,** ikasgelan landutako egoerek baliagarri izan behar dute ikasleek modu kontzientean atxiki daitezen musikarekin, ikusizko esparruarekin eta gero eta gehiago lantzen dituzten arte adierazpenekin. Konpetentzien araberako hezkuntzaren ikuspegitik, eskolaren egitekoa ezin da mugatu edukiak irakatsi eta ikasaraztera, egoera konplexuak ebazteko ezagutza eskuragarriak erabiltzen eta transferitzen ere irakatsi behar baitu, ikasleak bizitza pertsonalerako, sozialerako, akademikorako eta lanerako prestatzeko.

## Ebaluazioaren egitekoa, arte hezkuntzan

Gida hau eremu formaleko zein ez formaleko arte hezkuntzako programak ebaluatzeko adierazleak sortzera bideratuta dagoenez, egoki ikusten dugu ebaluazioak proiektu eta prozesu artistikoetan duen egitekoari buruzko

6. Oinarrizko Hezkuntzako Curriculuma

sarrera bat egitea. Gai garrantzitsua da, ebaluazioa ez baita, gure iritziz, azterketa edo prozesu artistiko bat egiten duten ikasleei Oharra jartzea helburu duen informazioa biltzeko metodoa soilik; ikaskuntzarako datu garrantzitsuen azterketara hurbiltzeko eta hura hobetzeko erabakiak hartzeko modua era bada.

Hurrengo orrialdeetan, zenbait adierazle azalduko ditugu, eta adierazle horien bidez ikusiko dugu zer inpaktu eragin dezaketen arte proiektuek hezkuntza komunitateen maila guztietan (ikasleengan, irakasleengan, familiengan, hezkuntza testuinguruan eta proiektuekin lotutako erakundeetan).

Haanstrak eta Schönauk 2007an aipatu zutenez, ebaluazio azterketak egitea gero eta beharrezkoagoa da, argi uzteko arte hezkuntza tresna garrantzitsua dela etorkizuneko audientziak eraikitzen laguntzeko, eta arte hezkuntzak ematen zaiona baino motibazio, gizarte eta ikasketa eragin handiagoa duela erakusteko. Egile horiek (ibidem) hezkuntza ebaluazioek dituzten funtzioak ere azaltzen dituzte, hala nola funtzio selektiboa, feedbacka lortzekoa, diagnostikoa egitekoa, helburuak lortzekoa eta erantzukizunari loturikoa. Era berean, baieztatzen dute (ibidem) ebaluazio horiek hainbat arlotara edo ikasgaitara bideratuta daudela (ikasleen ikaskuntzara, irakaslegora, hezkuntza programetara, materialetara, etab.).

Hezkuntza ebaluazioa: kontzeptuak, funtzioak eta motak (datarik gabe) testuan ere aipatzen dira, goian aipatutako eremuak, eta, horiez gain, administrazioak aipatzen dira, testu horren arabera “ebaluazio eremua hedatuz sortuko baitira, hain zuzen, berebiziko garrantzia izango duten hainbat ebaluazio eredu”.



## Adierazleen gida

Jarraian aurkezten den adierazleen gidak helburu argia du, neurtzea zer eragin duen hezkuntza formaleko testuinguru batean garatutako proiektu artistiko batek (1) ikasleengan, (2) hezkuntza komunitatearegan, (3) inplikatutako kultura eragilearengan, (4) testuinguruan eta (5) hura bultzatzen duen eragilearengan.

Izan ere, dokumentu honek honako hipotesi hau du abiapuntu: hezkuntzaren eta kulturaren arteko lankidetza proiektu bat garatzeak, azken batean, eremu bateko eta besteko ezagutzen baturak, ikasgelatik harago doan eragina duela, eta horri lotutako testuinguruaren eraldaketa soziala errazten duela.

Aurreko orrialdeetan azaldu den bezala, gida hau Lehen Hezkuntzako lanean oinarritzen da, eta, beraz, haren eduki batzuk etapa honetakoak soilik dira. Halakoa da “1. helburua”, proiektu artistikoak ikasleen konpetentzien eskuratze prozesuan duen eraginarekin zerikusia duena. Alabaina, gainerako helburuak aplikagarriak dira beste hezkuntza etapa batzuetan egin beharreko balizko ebaluazioetan, hezkuntza komunitatearen, kultura eragilearen, testuinguruaren eta eragile bultzatzailearen gaineko eraginari lotuta baitaude.

Ebaluazio tresna hau ikastetxeak zein proiektuan parte hartzen duen kultura eragileak erabil dezaten diseinatuta dago. Eta, gainera, adierazle batzuen eta haiei lotutako datuen erabilerak beste eragile batzuen laguntza eskatuko du (erakunde publikoena, herritarren kolektiboena, testuinguruko enpresa pribatuena, etab.).

Gida osorik aplika daiteke, edo, nahi izanez gero, haren zati bat soilik erabil daiteke, ebaluatutako proiektuari lotutako interesen eta baliabideen arabera. Aplikazioa errazte aldera, tresnak berak orientabideak ematen ditu, ebaluazioari dagokionez lehentasunezkotzat eta bigarren mailakotzat jotzen diren gaiei buruz. Nolanahi ere, tresna irekia denez, proiektu bakoitzean zehaztu beharko litzateke zer epigraferi buruzko balorazioa egin nahi den, eta, hala badagokio, zenbait baztertu eta/edo gakotzat jotzen direnak gehitu behar diren.

Jarraian, azalpen labur batzuk emango ditugu, bai datuak biltzeko proposatzen diren metodologiei buruz, bai gida honetan behin eta berriz erabiltzen diren kontzeptu batzuei buruz.

*Proposatutako metodologiak*

- Zuzeneko behaketa: aztergaiaren behaketan oinarritutako datuak lortzeko metodoa da, aztergaian esku hartzeko premiarik gabea.
- Errubrika: Lehen Hezkuntzari dagozkion konpetentzia guztiak jasotzen dituen dokumentua da; dokumentu horretan, ebaluatzaileak markatuko du zein lantzen diren, kasuan-kasuan.
- Barne erregistroa: datu objektiboen/kuantitatiboen bilketa da, barne jarraipenaren bidezkoa; talde ebaluatzaile bakoitzak aukeratuko du zer metodologia erabili, zer behar eta zer baliabide dituen kontuan hartuta.
- Barne azterketa: datu subjektiboen/kualitatiboen bilketa da, barne jarraipenaren bidezkoa; talde ebaluatzaile bakoitzak aukeratuko du zer metodologia erabili, zer behar eta zer baliabide dituen kontuan hartuta.
- Gogobetetze inkesta: galdera itxiak eta 1etik 5era arte puntuatuz erantzun beharrekoak dituen inprimakia da, proiektuaren alderdi positiboei eta negatiboei buruzko iritzi zabalagoak emateko aukera ematen duena.
- Inkesta: ad hoc egindako galdera tipifikatuen multzoa da, dagokion adierazlea ebaluatzekoa.
- Focus group: iritzi eta eztabaida talde bat da, aldez aurreko harremanik ez duten 15 pertsonak osatutakoa, gehienez; eta moderatzaile batek ebaluatu nahi den adierazleari lotuta proposatuko dizkion gaiei buruz iritzia emateko eta eztabaidatzeko bilduko da.
- Elkarrizketa irekia: ebaluatu nahi den adierazlearen inguruan egindako galderen multzoa da, ebaluatzaileak gidatuta bada ere, aukera ematen duena elkarrizketatuak bere ikuspuntua zabal azal dezan, aurretik ezarritako gidoitik aldenduz.
- Prentsa clippinga eta online monitorizazioa: proiektuaren inguruan offline komunikabideetan (euskarri fisikoa dutenetan) eta online komunikabideetan (podcastetan, prentsa digitalean, ikus entzunezko kanaletan, etab.) egin diren argitalpenen jarraipena eta artxibatzea da, bai eta trafikoari, jarraitzaileei eta abarri buruzko estatistiken jarraipena eta analisia egitea ere, proiektuarekin lotutako webguneetan eta sare sozialetan.

*Kontzeptuak*

- Eragile bultzatzailea: inplikazio ekonomikotik harago, proiektuan erabakiak hartzeko eta kudeatzeko ahalmena duen erakundea. Eragile bultzatzailearen gain izango da pisu handiena.
- Kultura eragilea: edozein adierazpen artistiko, kultural edo sortzaile ardatz duen jarduera duen pertsona fisikoa edo juridikoa.
- Hezkuntza komunitatea: irakasleak, familiak eta ikastetxea bera, proiektu gisa.
- Beste eragile batzuk: erakunde publikoak edo proiektuari nolabait lotutako bestelako erakunde publiko edo pribatuak.

Proposatutako helburuen eta adierazleen erabilera praktikoa bultzatze aldera, hurbilketa horren 2 bertsio jaso dira datozen orrialdeetan. Hauek dira:

- Testua (16.-26. orrialdeetan): lehen irakurketa teoriko bat, hura abiapuntutzat hartuta, datuak jasotzeko norberaren diseinua egiteko aukera emango duena.
- Taulak (27.-37. orrialdeetan): aipatutako kontzeptu teorikoak, datuak jasotzeko tresna praktiko batean aplikatuak.

## 1. HELBURUA. IKASLEEI KONPETENTZIAK BERENGANATZEN LAGUNTZEA

HEZIBERRI 2020 hezkuntza eredu pedagogikoaren esparruak bereziki azpimarratzen du garrantzitsua dela ikasleek konpetentziak eskuratzea, zeharkakoak zein diziplina barnekoak, zuzendaritzak seinalatutako helburuak definitzen dituzten eta hezkuntza prozesu osoari zentzua ematen dioten hezkuntza helburuak lortu ahal izateko. Horregatik, ezinbestekoa da euskal hezkuntza sistemaren inguruan egindako proiektu ororen oinarria konpetentziak eskuratzea eta garatzea izatea.

0. adierazlea: **Parte hartzea.**
Zenbat ikaslek izan duten parte hartze aktiboa proiektuan.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Tartean diren ikasleen kopurua.
- Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

### 1.1.- Diziplina barneko konpetentziak

#### 1.1.1.- Arterako konpetentzia

1. adierazlea: Musika eta dantza
Musikatik eta dantzatik eratorritako ezagutzak eta metodologiak erabiltzea, gozatzeko eta nor bere buruarekin harmonian bizitzeko, gizartean eta inguru naturalean.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Ideiak eta sentimenduak sormenez adieraztea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**2. datua:** Besteen adierazpenak interpretatzea eta balioestea, musikari eta dantzari loturiko ezagutzak eta metodologiak erabiliz, gozatzeko eta nor bere buruarekin harmonian bizitzeko, gizartean eta inguru naturalean.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

2. adierazlea: **Adierazpen plastikoa eta ikusizko adierazpena.**
Arte plastikoetatik eta ikusizko arteetatik eratorritako ezagutzak eta metodologiak erabiltzea, gozatzeko eta nor bere buruarekin harmonian bizitzeko, gizartean eta inguru naturalean.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Kultura plastikoa eta ikusizko kultura izateko gai izatea, nork bere burua eta bere inguruko mundua hobeto ulertzeko.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**2. datua:** Adierazpen plastikoa eta ikusizko adierazpena sormenez erabiliz, nor bere inguruarekin komunikatzeko gai izatea, eguneroko bizitzako egoeretan.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

#### 1.1.2.- Diziplinartekotasuna

1. adierazlea: **Arterako konpetentzia ez diren diziplina barneko konpetentziak txertatzea.**
Ikasleak konpetentzia guztien zeharkakotasuna oinarri duen ikaskuntza prozesu holistiko bati jarraitzeko gai izatea.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektu batean beste diziplina batzuetako ezagutzak aplikatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): errubrika.

**2. datua:** Lankidetzarako metodologiak uztartzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

### 1.2.- Zehar konpetentziak

1. adierazlea: **Ikasten eta pentsatzen ikasteko konpetentzia: pentsatzen eta ikasten jakitea.**
Pertsona eta kolektiboek jarrera, trebetasun eta gaitasunak garatzea errealitate tokiko-globalari ikuspegi zabal eta kritiko batetik begira diezaioten [(H)ABIAN 2030].

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Iturri askotako informazioa bilatzeko, hautatzeko eta erregistratzeko gai izatea (izan iturriok idatzizkoak, ahozkoak, ikus entzunezkoak, digitalak...).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**2. datua:** Informazioa ulertzeko eta gogoan hartzeko gai izatea (ulertuz pentsatzea).



- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**3. datua:** Informazioa interpretatzeko eta ebaluatzeko gai izatea (kritikoki pentsatzea).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**4. datua:** Ideiak sortzeko eta hautatzeko gai izatea (sormena baliatuz pentsatzea).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**5. datua:** Baliabide kognitiboak modu estrategikoan baliatzeko gai izatea, beste egoera batzuetan ikasitakoa erabiliz eta ekarriz.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

<u>2. adierazlea:</u> **Hitzezko eta hitzik gabeko komunikaziorako eta komunikazio digitalerako konpetentzia: komunikatzen jakitea.**

GHEko pertsona eta kolektiboek ekimen eta aliantza globalak egituratzea, baina helburu berdinekin, eta horretarako estrategia, eragile eta gaiak identifikatzea [(H)ABIAN 2030].

• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
• Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Hitzez eta idatziz komunikatzeko gai izatea, hitz jario, autonomia, sormen eta eraginkortasun egokiarekin.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**2. datua:** Gorputz hizkuntzaren, hizkuntza artistikoaren eta hizkuntza matematikoaren oinarrizko kodeak modu bateratuan eta harmoniatsuan erabiltzeko gai izatea
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**3. datua:** Gizarteko komunikazio bideetako mezuak modu kritikoan interpretatzeko eta ebaluatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**4. datua:** IKT baliabideak modu egokian, eraginkorrean eta arduratsuan erabiltzeko gai izatea, zereginak diseinatzean eta planifikatzean, informazioa kudeatzean, produktu digitalak sortzean, lankidetzan aritzean eta emaitzak komunikatzean.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**5. datua:** Euskal gizartearen eta munduaren gizarte eta komunikazio errealitatea modu kritikoan interpretatzeko gai izatea, eta nork bere testuinguruan arduraz eta zentzu etikoz parte hartzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

<u>3. adierazlea:</u> **Elkarbizitzarako konpetentzia: elkarrekin bizitzen jakitea.**

Pertsona eta kolektiboek ikaskuntza prozesuak abiaraztea, norberaren hezkuntza jardunbideetan oinarrituta, eta lortutako ikaskuntzak prozesu berrietan txertatzea eta partekatzea [(H)ABIAN 2030] .

• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
• Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Nork bere eta besteen desirak bat egiteko gai izatea, nork bere sentimenduak, pentsamenduak eta desirak modu asertiboan azalduz eta, aldi berean, besteen sentimenduak, pentsamenduak eta desirak modu aktiboan entzunez eta kontuan hartuz.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**2. datua:** Taldean lan egiteko eta ikasteko gai izatea, eta nork bere ardurak bere gain hartzea eta lankidetzan jardutea, helburu komuneko zereginetan, askotariko pertsonak eta iritziak izateak berekin dakarren aberastasuna aintzat hartuz.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**3. datua:** Modu aktiboan parte hartzeko eta lidergoa bere gain hartzeko gai izatea, eskolako zein eskolaz kanpoko testuinguruko ekimenetan.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**4. datua:** Giza eskubideen araberako printzipio etikoekin eta bizikidetzarako oinarrizko gizarte ohituretatik eratorritako gizarte arauekin bat jokatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**5. datua:** Gatazkak konpontzeko gai izatea, elkarrizketaren eta negoziazioaren bidez.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

**6. datua:** Dibertsitatea errespetatuz eta hari balioa emanez elkarbizitzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

<u>4. adierazlea:</u> **Norbera izaten ikasteko konpetentzia: izaten jakitea.**

GEHko pertsona eta kolektiboek beren protagonismoa beren gain hartzea, desberdintasunak eragiten dituzten arrazoiei alternatibak biltzen banaka eta kolektiboan jardun dezaten, eta gizartea inplikatzeko eta mobilizatzeko gai izan daitezen [(H)ABIAN 2030].

• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
• Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Nor bere pentsamendua eta ikasteko estilo kognitiboa autoerregulatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.

- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**2. datua:** Nor bere gorputzaren funtzioak eta itxura autoerregulatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**3. datua:** Nor bere emozioak autoerregulatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**4. datua:** Nor bere jokabide morala autoerregulatzeko gaitasuna.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**5. datua:** Nor bere erabakiak hartzeko eta eginbeharrak betetzeko motibazioa eta nahimena autoerregulatzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**6. datua:** Autoestimu positiboa eta errealista izateko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**7. datua:** Erabaki pertsonalak hartzeko gai izatea eta nor bere erabakien eta eginbeharren ardura bere gain hartzeko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

5. adierazlea: **Ekimenerako eta espiritu ekintzailerako konpetentzia: egiten eta ekiten jakitea.**
Pertsona eta kolektiboek ikaskuntza prozesuak abiaraztea, norberaren hezkuntza jardunbideetan oinarrituta, eta lortutako ikaskuntzak prozesu berrietan txertatzea eta partekatzea [(H)ABIAN 2030].
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek.
• Lehentasuna: 1.
**1. datua:** Ideia berriak eta konponbideak sortzeko gai izatea, bai eta errealitatea hobetzeko alternatibak proposatzea ere, izaera kritikoarekin, elkartasunarekin eta ardura sozialarekin.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**2. datua:** Ekintza planifikatuak gauzatzeko eta, behar denean, doikuntzak egiteko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.
**3. datua:** Gauzatutako ekintzak ebaluatzeko eta hobekuntza proposamenak egiteko gai izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): zuzeneko behaketa.

## 2. HELBURUA: HEZKUNTZA KOMUNITATEAREN GARAPENA ABERASTEA

HEZIBERRI 2020k aipatzen du zer garrantzi duen hezkuntza eragile guztien erantzunkidetasunak, eskolatzetik harago, hezkuntzaren helburuak lortzeko funtsezko konpetentziak eskuratzeko eta menderatzeko orduan. Hori oinarri hartuta, helburu honek "hezkuntza komunitateari" egiten dio erreferentzia, komunitate horrek hartzen eta erlazionatzen baititu hezkuntza prozesu formalak, ez formalak eta informalak, helburutzat jarrita pertsona ororen bizitza osoko prestakuntza, sustapena eta garapena, lehentasuna emanez, betiere, haur eta gazteenari.

### 2.1. Irakasleak

#### 2.1.1. Proiektuan parte hartzen dutenak

1. adierazlea: **Inplikazioa.**
Irakasleek proiektua gauzatzeko konpromisoa hartzea.
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
• Lehentasuna: 1.
**1. datua:** Tartean diren irakasleen kopurua.
Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.
**2. datua:** Eskainitako lanordu kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.
**3. datua:** Berariaz egindako bilera kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

2. adierazlea: **Zeharkakotasuna.**
GEHaren jardunbideetan GEHa eta Lankidetza helburu berarekin eta partekatutako gaiekin erlazionatzea [(H)ABIAN 2030].
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
• Lehentasuna: 1.
**1. datua:** Tartean diren eta arte arloan espezializatuta ez dauden irakasleen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.
**2. datua:** Koordinazio bilera orokorrei eskainitako denbora.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

3. adierazlea: **Konpetentziak/ezagutzak eskuratzea.**
Irakasleek gaitasuna izatea konpetentziak eta ikaskuntza esanguratsua lortzea oinarri dituen ikaskuntza prozesu bat gauzatzeko.
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
• Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Ikasleen testuinguru, kultura eta gaitasun dibertsitatea kontuan hartuta irakasteko prestakuntza izatea.
- Oharra: aztertu egingo dira irakasleek alderdi horri lotuta hautematen dituzten indarguneak eta ahulguneak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa; inkesta.

**2. datua:** Ikasleak ezagutzaren gizartean txertatzeko gai izatea.
- Oharra: hasierako diagnostiko bat egingo da, alderdi horren jarraipena egiteko, proiektuak dirauen artean.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa; inkesta.

**3. datua:** Kultura aniztasuna, demokrazia eta elkartasuna oinarri dituen herritartasun eredua oinarri hartuta irakastearen aldeko jarrera izatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): Barne azterketa.

4. adierazlea: **Proiektuaren eragina, emozioei dagokienez.**
Proiektuan parte hartzen duten irakasleek hari buruz duten sentsazio orokorra balioestea.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.
- **1. datua:** Proiektuak dirauen arteko gogobetetzea.
  - Epea: proiektuaren iraupena.
  - Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

### 2.1.2. Proiektuan parte hartzen ez dutenak

1. adierazlea: **Sortutako interesa.**
Proiektuak zer eragin izan duen hartan parte hartu ez duten irakasleengan.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 2.

**1. datua:** Proiektuarekin bat egite berriak, prozesuak dirauen denboran.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Galderak/kontsultak/iruzkinak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

## 2.2. Familiak

### 2.2.1. Proiektuan parte hartzen dutenak

1. adierazlea: **Inplikazioa.**
GEHaren jardunbideek pertsona eta kolektiboen jarduna eta inplikazioa sustatzea, alternatiba jasangarri, solidario eta ekitatiboak abiarazteko [(H)ABIAN 2030.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Tartean diren familien kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Proiektuari eskainitako ordu kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

2. adierazlea: **Sortutako interesa.**
Proiektuak zer eragin duen hartan parte hartu duten familiengan.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektuarekin bat egite berriak, prozesuak dirauen denboran.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Galderak/kontsultak/iruzkinak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Bilerei eskainitako denbora (orokorrei zein berariazkoei).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**4. datua:** Aurkezpen ekitaldietara bertaratzea (halakorik balego).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

3. adierazlea: **Parte hartzea.**
Familien parte hartzea, proiektu eta ekintza kulturaletan.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektuarekin bat egite berriak, prozesuak dirauen denboran.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Galderak/kontsultak/iruzkinak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Bilerei eskainitako denbora (orokorrei zein berariazkoei).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**4. datua:** Aurkezpen ekitaldietara bertaratzea (halakorik balego).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

4. adierazlea: **Proiektuaren eragina, emozioei dagokienez.**
Proiektuan parte hartzen duten familiek hari buruz duten sentsazio orokorra balioestea.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektuak dirauen arteko eta proiektua amaitu osteko gogobetetzea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): gogobetetze inkesta.

#### 2.2.2. Proiektuan parte hartzen ez dutenak

1. adierazlea: **Sortutako interesa.**
Proiektuak zer eragin duen hartan parte hartu ez duten familiengan.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 2.

**1. datua:** Aurkezpen ekitaldietara bertaratzea (halakorik balego).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Galderak/kontsultak/iruzkinak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

### 2.3. Ikastetxea

1. adierazlea: **Sortutako interesa.**
GEHaren hezkuntza jardunbideak ikuspegi globala duten tokiko jardunak eta eskubideen ikuspegitik begiratutako tokiko garapenak izatea [(H)ABIAN 2030].
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Izapidetutako matrikulazio berrien kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena eta hurrengo ikasturtea.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Komunikabideetan plazaratutako argitalpenen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**3. datua:** Jasotako aintzatespenen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**4. datua:** Kanpotik egindako galdera/kontsulta/iruzkinen kopurua eta mota.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

2. adierazlea: **Profesionalen sareak.**
Profesionalen arteko sareak eratzea, proiektu bat gauzatzearen ondorioz.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Profesionalen foroetan egindako aurkezpenen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Profesionalen sareekin bat egite berrien kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

3. adierazlea: **Hezkuntza lantaldearekiko eta familiekiko harremana.**
Profesionalen lantaldearen eta familien inplikazio mailaren aurrerapena, ikastetxearen hezkuntza proiektuan.
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 2.

**1. datua:** Zenbat bilera eta/edo foro komun egin diren eta haien zer balioespen kualitatibo egin den, bai profesionalen lantalde osoarekin eta bai ikastetxearekin loturiko familiekin.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

4. adierazlea: **Artearen eta Kulturaren presentzia, ikastetxeko eguneroko bizitzan.**
GEHaren jardunbideetan herritartasun globaleko alternatibak bilatzeko azterketa kritikoa egitea [(H)ABIAN 2030].
- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Ikasturteak dirauen artean aktibatutako ekimen artistikoen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**2. datua:** Hurrengo ikasturtean aktibatutako ekimen artistikoen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**3. datua:** Espazioari lotuta egindako esku hartzeen kopurua eta mota.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.



## 3. HELBURUA. TESTUINGURUA SENTSIBILIZATZEA, AINTZAT HAR DEZAN ZER GARRANTZI DUTEN ARTEEK, GIZARTE ERALDAKETARAKO HEZKUNTZA (GEH) GAUZATZEKO GILTZARRIETAKO BAT DIREN ALDETIK

Askotariko adimenen inguruko teoriatik abiatuta, arteen hezkuntza ikuspegiak ikasle guztien eskura jarri nahi ditu arte hezkuntzaren onurak, ikasgai guztietan. Ikuspegi horren helburua, halaber, teoria testuinguruan jartzea da, arte diziplinen aplikazio praktikoaren bidez. Eta horretarako, (H)ABIANen aipatzen den bezala, eraldaketa pertsonal eta sozialak sortzeko asmoz diharduten pertsonekin eta kolektiboekin jardun behar da, kritikoki aztertzen eta hausnartzen baitute, eta haien proposamenek eta harremanetarako moduek eskubideak, erantzukizunak, zaintzak, aniztasuna eta lankidetza barne hartzen baitituzte.

### 3.1. Auzoa[7]

1. adierazlea: **Parte hartzea.**
Proiektuan parte hartu duten auzokoen, kolektiboen eta bestelako eragileen (merkatariak, enpresak, proiektua, etab.) parte hartzearen balioespen kualitatiboa eta kuantitatiboa.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileek.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektuan parte hartu duten pertsonen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Parte hartu duten pertsonen dibertsitatea.
- Oharra: adinari, generoari, jatorriari eta abarri loturiko dibertsitatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Proiektuan parte hartu duten kolektiboen edo bestelako eragileen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa; inkesta.

**4. datua:** Proiektuan parte hartu duten kolektiboen eta eragileen izaera.
- Oharra: hemen aipatzen diren kolektibo edo eragileak dira, besteak beste, GGKEak, kultura eragileak, hezkuntza komunitatea, Berritzeguneak, unibertsitateak, komunikabideak, gizarte mugimenduak, kolektibo feministak, ekologistak, baztertutako herrietako kolektiboak, migratzaileen kolektiboak.[8]
- Epea: proiektuaren iraupena
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa; inkesta.

2. adierazlea: **Proiektuak auzoan duen presentzia.**
Proiektua ikastetxetik harago zenbat zabaldu den auzoko beste espazio batzuetara, eta zer parte hartze maila izan duen auzoak ekimen horietan.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Auzoan (ikastetxetik kanpo) egindako ekintzen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Espazioen tipologia (kultura guneak, espazio publikoa, dendak, etab.).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Espazio horietan egindako aurkezpenetara bertaratutako pertsonen kopurua (halakorik balego).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**4. datua:** Aurkezpen horietara bertaratutako pertsonen dibertsitatea
- Oharra: adinari, generoari, jatorriari eta abarri loturiko dibertsitatea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

3. adierazlea: **Norbanakoaren eta taldearen eraldaketa.**
Parte hartzen duten pertsonek eta kolektibo edo eragileek gizarte eta bizitza alternatiba berriak aintzat hartzea eta bilatzea.

- Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileak.
- Lehentasuna: 2.

**1. datua:** Parte hartzen duten pertsonek  gizarte eraldaketarako emaitzen bilaketan eragina duten gaien inguruan duten ikuspegiaren bilakaera.
- Oharra:jarraian, alderdi horietako batzuk aipatuko dira, baina komeni da eragile bakoitzak balioestea, prozesuaren hasieran, zein diren bere proiektura gehien egokitzen direnak, bere lanari ahalik gehien doitutako  ebaluazioa egiteko.
  - Botere harremanak.
  - Dibertsitatearen kudeaketa (izan dibertsitate funtzionala, kulturala, soziala, generoari dagokiona, sexu orientazioari dagokiona, etab.).

7. Atal honetan aipatzen den ebaluazio oro ikastetxearekin lotura zuzenik ez duten baina hura dagoen auzoari loturik dauden pertsonen, eragileen eta  kolektiboen gainekoa da.

8. (H)ABIAN 2030etik ateratako sailkapena.

• Gatazken kudeaketa.
• Giza Eskubideen kontzientzia hartzea.
• Genero ikuspegiaren kontzientzia hartzea.
• Garapen jasangarriaren kontzientzia hartzea.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): focus group; inkesta.

**2. datua:** Parte hartzen duten kolektiboen edo eragileen lan prozeduretan, estatutuetan, egitekoan edo oinarrietan egindako aldaketak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): focus group; inkesta.

### 3.2. Hiria

1. adierazlea: **Parte hartze kulturala.**
Proiektua egiten den auzoaren kultura ohituren bilakaera eta proiektuak hiriaren kultura bizitzan duen eragina.
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak, inplikatutako kultura eragileak eta proiektuaren eraginpeko beste eragile batzuek (datu emaile diren aldetik, gehien gehienetan).
• Lehentasuna: 3.

**1. datua:** Auzoko zenbat pertsona matrikulatu diren tokiko erakundeen bultzadarekin hiriko beste espazio batzuetan egindako arte edo kultura ekintza hezitzaileetan.
- Oharra: datu hau eskuratzeko, hirugarrenen lankidetza behar da, tokiko erakundeena, batez ere, eta, horregatik, komeni da datu bilketa hau udal mailako estrategia baten parte izatea eta, beraz, aztergai den proiektutik harago joatea.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Auzoko zenbat pertsonak hartzen duten parte udalaren arte edo kultura programazioetan, tokiko erakundeen bultzadarekin hiriko beste espazio batzuetan egindakoetan.
- Oharra: datu hau eskuratzeko, hirugarrenen lankidetza behar da, tokiko erakundeena, batez ere, eta, horregatik, komeni da datu bilketa hau udal mailako estrategia baten parte izatea eta, beraz, aztergai den proiektutik harago joatea.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

2. adierazlea: **Inplikazioa.**
Tokiko erakundeek eta hiriarekin loturiko eragileek proiektuarekin duten konpromisoa.
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileak.
• Lehentasuna: 2.

**1. datua:** Tokiko erakundeek proiektura bideratutako baliabide ekonomikoak (bestelako baliabideak ere izan daitezke).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Hiriarekin loturiko bestelako eragileek proiektura bideratutako baliabide ekonomikoak (bestelako baliabideak ere izan daitezke).
- Oharra: bestelako eragileak aipatzen ditugunean, tokiko erakundeen parte ez den eta bere jarduna proiektuaren testuinguruan garatzen duen edozein pertsona fisiko edo juridiko aipatzen dugu.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Proiektua haren garapeneko uneren batean bertatik bertara ezagutu duten tokiko agintarien edo bestelako eragileen ordezkarien kopurua.
- Oharra: bertatik bertara ezagutzea proiektuari loturiko bilera, aurkezpen edo fororen batera bertaratzea da, besteak beste.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

3. adierazlea: **Arte Hezkuntza babestea.**
Proiektuak zer eragin duen Arte Hezkuntzari lotutako tokiko ekimen berrien aktibatzean edo lehendik diren lan ildoen finkatzean.
• Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak, inplikatutako kultura eragileak eta proiektuaren eraginpeko beste eragile batzuek (datu emaile diren aldetik, gehien gehienetan).
• Lehentasuna: 3.

**1. datua:** Zenbat diru laguntza edo programa berri bideratu diren tokiko Arte Hezkuntza proiektuak babesteko.
- Oharra: sektore publikoak zein pribatuak bultzatutako diru laguntzak edo programak izan daitezke.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Tokiko arte hezkuntzako proiektuak laguntzeko diru laguntza edo programa horietarako proposamenak aurkezten dituzten eragileen kopurua eta tipologia.
- Oharra: eragileen tipologia aztertzeko, zer forma juridiko duten eta zer lan esparrutan diharduten (kultura, gizartea, hezkuntza, etab.) hartuko da kontuan.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Zer baliabide ekonomiko bideratzen diren, diru laguntza edo programa horietara.
- Oharra: sektore publikotik zein pribatutik bultzatutakoak baliabide ekonomikoak eta/edo, ekimen sortu berriak ez direnean, haien bilakaera

(gorakorra, beherakorra edo aldaketarik gabea).
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**4. datua:** Diru laguntza edo programa horrek Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzarekin duen koherentzia maila.
- Oharra: (H)ABIAN estrategian jasotako GEHren 6 elementu nagusiak hartuko dira erreferentziatzat: subjektu protagonistak, ikuspegi politiko pedagogikoak, eskubideen ikuspegia, tokiko-global ikuspegia, agenteen arteko erantzunkidetasuna eta ikaskuntza kultura.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa; elkarrizketa.

**5. datua:** Hiriko beste ikastetxe batzuetan Arte Hezkuntzari lotuta aktibatutako proiektuen kopurua eta ezaugarriak.
- Oharra: kopuruaz gain, funtsezkoa da abian jarritako proiektu horien tamaina aztertzea, hots, haien iraupena, haietara bideratutako baliabideak (baliabide ekonomikoak eta materialak, giza baliabideak, etab.), finantzazio iturriak, gai nagusiak, (H)ABIAN 2030 estrategiarekiko lotura, etab.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa; elkarrizketa.

### 3.3. Kultura sektorea (tokikoa)

1. adierazlea: **Testuinguruko kultura eragileen arteko harremanak.**
Proiektuak zer eragin duen testuinguruko kultura eragileen arteko harremanetan eta haiek Arte Hezkuntzan duten jardueran.
- Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektuan parte hartu duten tokiko kultura eragileen kopurua.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Inplikatutako eragilearekin aurrez lanik egin ez duten tokiko zenbat kultura eragilek parte hartu duten proiektuan.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**3. datua:** Inplikatutako eragilearekin aurrez lan egin izan duten tokiko zenbat kultura eragilek parte hartu duten proiektuan.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne erregistroa.

**4. datua:** Besteekin sarean egindako lanaren balioespena.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**5. datua:** Proiektu hau abiapuntu izanik, zenbat proiektu jarri diren martxan, beste eragile batzuekin lankidetzan.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**6. datua:** Zenbat profesionalen topagune, foro edo elkarte bultzatu dituzten tokiko kultura eragileek, Arte Hezkuntzaren inguruan.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

2. adierazlea: **Arte Hezkuntzan izandako eragina.**
Tokiko kultura eragileek Arte Hezkuntzarako proiektuak abian jartzea.
- Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak eta proiektuaren eraginpeko beste eragile batzuek (datu emaile diren aldetik, gehien-gehienetan)..
- Lehentasuna: 3.

**1. datua:** Proiektuan parte hartu duten tokiko kultura eragileetatik zenbatek jarri dituzten abian Arte Hezkuntzako proiektu berriak, beren kasa.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): elkarrizketa; inkesta.

**2. datua:** Zer baliabide (ekonomikoak, materialak, giza baliabideak, etab.) bideratu diren Arte Hezkuntzako proiektu horietara.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): elkarrizketa; inkesta.

**3. datua:** Zer eragin izan duten proiektu horiek, antolakuntza mailan, inplikatutako egituretan.
- Oharra: hainbat alderdi aztertuko dira, hala nola konpetentzia berrien lorpena, antolaketa aldaketak, kontratazio aukerak eta beharrak, lan ildo berrien sorrera, etab.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): elkarrizketa; inkesta.

**4. datua:** Zer koherentzia maila duten proiektu horiek GEHrekin.
- Oharra: (H)ABIAN estrategian jasotako GEHren 6 elementu nagusiak hartuko dira erreferentziatzat: subjektu protagonistak, ikuspegi politiko pedagogikoak, eskubideen ikuspegia, tokiko global ikuspegia, agenteen arteko erantzunkidetasuna eta ikaskuntza kultura.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): elkarrizketa; inkesta.



## 4. HELBURUA. PROIEKTUAN INPLIKATUTAKO KULTURA ERAGILEAK INDARTZEA

“Komunitate hezitzailearen” ildoari jarraituz eta HEZIBERRI 2020k seinalatzen duenez, esparru pedagogikoak pertsona ororen hezkuntza eskubidea islatu nahi du, eta horretarako, zehazki, zenbait sinergia ezartzen ditu ikastetxeetako hezkuntza komunitateen, udal politiken eta gizarte eta kultura eragileen esku hartzeen artean. Horri esker, epe labur eta luzerako lan dinamikak finkatzeko aukera izango du kultura eragileak.

<u>1. adierazlea:</u> **Giza baliabideak.**
Proiektuaren eraginaren azterketa, hari lotutako profesionalei dagokienez.

- Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Zenbat profesionalek parte hartu duten proiektuan eta zer egiteko izan duten, proiektuaren antolakuntzari zuzen-zuzenean lotuta.
- Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Zenbat profesional kontratatu dituen inplikatutako eragileak proiekturako, beren-beregi, eta zer egiteko izan duten
- Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Zenbat profesional kontratatu diren proiektuaren garapena dela eta (ez proiektua gauzatzeko)..
- Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**4. datua:** Zer konpetentzia edo ezagutza eskuratu dituzten proiektuan parte hartu duten profesionalek, haren garapena dela eta.
- Oharra: inplikatutako eragilearen lantaldeko profesionalen konpetentzia lorpenak aztertuko dira; gaitasun eta ezagutza horiek proiektutik haragokoak izan daitezke, proiektuaren aktibazioarekin zuzen-zuzenean lotuta eskuratu badira, betiere (esate baterako, aspalditik egin nahi izan ziren prestakuntzak badira, baina ez bada horiei ekiteko erabakirik hartu proiektua abian jarri arte).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): elkarrizketa; inkesta; barne azterketa.

**5. datua:** Eraldaketa pertsonala eta antolakuntzakoa.
- Oharra: proiektuak zer eragin duen neurtuko da (bai eta parte hartu duten pertsonek zer balorazio kualitatibo egin duten ere), hainbat alderdi kontuan hartuta, hala nola gatazken kudeaketa, entzuteko eta komunikatzeko gaitasuna, taldeko lana, sormena, gardentasuna, pentsamendu kritikoa, ezagutzen transferentzia, inplikazioa eta proaktibitatea.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): reunión interna; barne azterketa; inkesta; entrevista.

<u>2. adierazlea:</u> **Oihartzun publikoa.**
Proiektuan inplikatutako eragilea ikusaraztea, foro profesionaletan zein maila orokorrean.

- Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Zenbat argitalpen eta zer motatakoak plazaratu diren komunikabideetan, proiektuari lotuta.
- Oharra:komunikabide orokorrak zein espezializatuak hartuko dira kontuan.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): prentsa clippinga eta online monitorizazioa.

**2. datua:** Zenbat argitalpen eta zer motatakoak plazaratu diren komunikabideetan, proiektuari lotu gabe.
- Oharra: komunikabide orokorrak zein espezializatuak hartuko dira kontuan, eta hizpide dugun proiektua egin aurretik jasotako arretarekin alderatuko da.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): prentsa clippinga eta online monitorizazioa.

**3. datua:** Proiektuari edo inplikatutako eragileari lotutako sare sozialen bilakaera.
- Oharra: alderdi kuantitatiboak (jarraitzaileak, ikustaldiak, etab.) zein kualitatiboak (elkarrekintza mota, haien interesa, etab.) hartuko dira kontuan.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): prentsa clippinga eta online monitorizazioa; barne azterketa.

**4. datua:** Inplikatutako eragileari lotutako sare sozialen bilakaera.
- Oharra: alderdi kuantitatiboak (jarraitzaileak, ikustaldiak, etab.) zein kualitatiboak (elkarrekintza mota, haien interesa, etab.) hartuko dira kontuan.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): online monitorizazio; barne azterketa.

**5. datua:** Zenbat aintzatespen jaso diren proiektuari lotuta.



- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**6. datua:** Zenbat eta zer motatako gonbidapenak jaso diren, proiektua foroetan aurkezteko.

- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologías posibles: barne azterketa.

**7. datua:** Zenbat eta zer motatako kanpoko harremanak izan diren (galderak, kontsultak edo iruzkinak), proiektuari lotuta.

- Oharra: sare sozialetan egindakoak ez diren harremanak hartuko dira kontuan (halakoak aztertzeko berariazko atal bat baitago).
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

3. adierazlea: **Inplikatutako eragilearen eraldaketa.**
Proiektuak inplikatutako erakundearen jarduera ildoen dibertsifikazioan izan duen eraginaren azterketa, bai eta lan ingurunean izandakoa ere (profesionalen sareak, elkarteak, etab.).

- Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak.
- Lehentasuna: 2.

**1. datua:** Zenbat eta zer motatako lan ildo berriak aktibatu diren, proiektua egin eta gero.

- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Zer itzulkin ekonomiko ekarri duten lan ildo horiek.

- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Profesionalen sareekin edo kolektiboekin bat egite berrien kopurua.

- Oharra: hizpide den proiektuan landutako esparruei lotutako sareak eta kolektiboak hartuko dira kontuan, bai eta aktibatutako lan ildo berriei lotutakoak ere.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

## 5. HELBURUA. PROIEKTUAREN ERAGILE BULTZATZAILEARI AURREKONTUEN EGONKORTASUNA LORTZEN LAGUNTZEA

Guzmánek 2018ko Artea, Hezkuntza eta Garapena txostenean aipatzen duenez, “noizbait Arte Hezkuntzari loturiko zerbaitetara bideratutako aurrekonturen bat bada, lotura txikiena izanda ere, aurrekontu hori ministerio edo sail batean zentralizatuta geratzen da, eta horiek ez dute aukerarik (edo borondaterik) izaten beste batzuekin partekatzeko. Zenbaitetan, administrazioko burokraziak, edozein mailatakoa izanik ere, ikuspegi mugatua izaten du, eta uzkur izaten da lankidetzan aritzeko”. Hori horrela izanik, proiektu honen helburuetako bat da argitzea ea proiektuaren eragile bultzatzaileak aldeko erantzuna jasotzen duen, egindako ekintzak direla eta, zenbait erronkari lotuta, hala nola proiektuan parte hartu duten eragileekiko lan harremanen finkatzean, lan ildo berriak irekitzean, esparru pribatuan zein publikoan kontratu gehiago eta hobeak lortzean, finantzazio iturri berriak aurkitzean, etab.

1. adierazlea: **Baliabide ekonomikoak.**
Proiektuaren irakurketa ekonomikoa, aurrekontu eta estrategia mailan.

- Nork betetzekoa: eragile bultzatzaileak.
- Lehentasuna: 1.

**1. datua:** Proiektuaren guztiko aurrekontua.

- Oharra: proiektuak sortutako gastuak eta sarrerak, bi-biak, hartuko dira kontuan; azterketa kuantitatiboa eta kualitatiboa egingo da.
- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**2. datua:** Aurrekontuaren dimentsioa, eragile bultzatzailearen guztizko funtsekin alderatuta.

- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**3. datua:** Proiektuaren finantzazio iturrien dibertsitatea.

- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

- Lehentasuna: 2.

**4. datua:** Aurrez eragile bultzatzailearekin loturaren bat duten zenbat eta zer motatako eragileek babestu duten proiektua ekonomikoki.

- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

**5. datua:** Aurrez eragile bultzatzailearekin loturarik ez duten zenbat eta zer motatako eragileek babestu duten proiektua ekonomikoki.

- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.

- Lehentasuna: 3.

**6. datua:** Zer itzulkin ekonomiko lortu duten, zuzenean, proiektuan parte hartu duten edo hura garatu den tokiko testuinguruko eragileek.

- Oharra: azpikontratazioak, proiektuak antolatutako ekitaldiek eragindako negozioak, etab. har-

tuko dira kontuan; informazio hori lortzea zaila izan daitekeenez, proiektuak eragindakoek zenbatespen ekonomikoa eta balorazio kualitatiboa egitea lehenetsiko da.

- Epea: proiektuaren iraupena.
- Metodologia erabilgarria(k): elkarrizketa; inkesta.

**7. datua:** Zer itzulkin ekonomiko lortu dituen eragile bultzatzaileak, hizpide dugun proiektua gauzatzea dela eta.

- Oharra: ez dira kontuan hartuko proiektuaren baitan lortutako sarrerak, hura egin ostean lortutako itzulkin ekonomikoa baizik; ildo horretatik, aztertu egingo da zer erabilera ematen dion antolakuntzak itzulkin horri, bai eta beste lan ildo batzuen bideragarritasunean edo aktibazioan duen eragina ere.
- Epea: bi urte gutxienez, proiektua abian jarri eta gero.
- Metodologia erabilgarria(k): barne azterketa.



## 1. HELBURUA. IKASLEEI KONPETENTZIAK BERENGANATZEN LAGUNTZEA

**Data:**

| | | |
|---|---|---|
| 0. adierazlea: **Parte hartzea**<br>Zenbat ikaslek izan duten parte hartze aktiboa proiektuan.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Tartean diren ikasleen kopurua.<br>*Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.* | | Oharrak: |
| 1.Diziplina barneko konpetentziak | | |
| 1.1. Arterako konpetentzia | | |
| 1. adierazlea: **Musika eta dantza**<br>Musikatik eta dantzatik eratorritako ezagutzak eta metodologiak erabiltzea, gozatzeko eta nor bere buruarekin harmonian bizitzeko, gizartean eta inguru naturalean.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Ideiak eta sentimenduak sormenez adieraztea. | | Oharrak: |
| Besteen adierazpenak interpretatzea eta balioestea, musikari eta dantzari loturiko ezagutzak eta metodologiak erabiliz, gozatzeko eta nor bere buruarekin harmonian bizitzeko, gizartean eta inguru naturalean. | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Adierazpen plastikoa eta ikusizko adierazpena**<br>Arte plastikoetatik eta ikusizko arteetatik eratorritako ezagutzak eta metodologiak erabiltzea, gozatzeko eta nor bere buruarekin harmonian bizitzeko, gizartean eta inguru naturalean.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Kultura plastikoa eta ikusizko kultura izateko gai izatea, nork bere burua eta bere inguruko mundua hobeto ulertzeko. | | Oharrak: |
| Adierazpen plastikoa eta ikusizko adierazpena sormenez erabiliz, nor bere inguruarekin komunikatzeko gai izatea, eguneroko bizitzako egoeretan. | | Oharrak: |
| 1.2.Diziplinartekotasuna | | |
| 1. adierazlea: **Arterako konpetentzia ez diren diziplina barneko konpetentziak txertatzea**<br>Ikasleak konpetentzia guztien zeharkakotasuna oinarri duen ikaskuntza prozesu holistiko bati jarraitzeko gai izatea.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Proiektu batean beste diziplina batzuetako ezagutzak aplikatzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| Lankidetzarako metodologiak uztartzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| 2. Zehar konpetentziak | | |
| 1. adierazlea: **Ikasten eta pentsatzen ikasteko konpetentzia: pentsatzen eta ikasten jakitea**<br>Pertsona eta kolektiboek jarrera, trebetasun eta gaitasunak garatzea errealitate tokiko-globalari ikuspegi zabal eta kritiko batetik begira diezaioten [(H)ABIAN 2030].<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Iturri askotako informazioa bilatzeko, hautatzeko eta erregistratzeko gai izatea (izan iturriok idatzizkoak, ahozkoak, ikus entzunezkoak, digitalak...). | | Oharrak: |
| Informazioa ulertzeko eta gogoan hartzeko gai izatea (ulertuz pentsatzea). | | Oharrak: |
| Informazioa interpretatzeko eta ebaluatzeko gai izatea (kritikoki pentsatzea). | | Oharrak: |
| Ideiak sortzeko eta hautatzeko gai izatea (sormena baliatuz pentsatzea). | | Oharrak: |

| | | |
|---|---|---|
| Baliabide kognitiboak modu estrategikoan baliatzeko gai izatea, beste egoera batzuetan ikasitakoa erabiliz eta ekarriz. | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Hitzezko eta hitzik gabeko komunikaziorako eta komunikazio digitalerako konpetentzia: komunikatzen jakitea**<br>GHEko pertsona eta kolektiboek ekimen eta aliantza globalak egituratzea, baina helburu berdinekin, eta horretarako estrategia, eragile eta gaiak identifikatzea [(H)ABIAN 2030].<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Hitzez eta idatziz komunikatzeko gai izatea, hitz jario, autonomia, sormen eta eraginkortasun egokiarekin. | | Oharrak: |
| Gorputz hizkuntzaren, hizkuntza artistikoaren eta hizkuntza matematikoaren oinarrizko kodeak modu bateratuan eta harmoniatsuan erabiltzeko gai izatea | | Oharrak: |
| Gizarteko komunikazio bideetako mezuak modu kritikoan interpretatzeko eta ebaluatzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| IKT baliabideak modu egokian, eraginkorrean eta arduratsuan erabiltzeko gai izatea, zereginak diseinatzean eta planifikatzean, informazioa kudeatzean, produktu digitalak sortzean, lankidetzan aritzean eta emaitzak komunikatzean. | | Oharrak: |
| Euskal gizartearen eta munduaren gizarte eta komunikazio errealitatea modu kritikoan interpretatzeko gai izatea, eta nork bere testuinguruan arduraz eta zentzu etikoz parte hartzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Elkarbizitzarako konpetentzia: elkarrekin bizitzen jakitea**<br>Pertsona eta kolektiboek ikaskuntza prozesuak abiaraztea, norberaren hezkuntza jardunbideetan oinarrituta, eta lortutako ikaskuntzak prozesu berrietan txertatzea eta partekatzea [(H)ABIAN 2030].<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Nork bere eta besteen desirak bat egiteko gai izatea, nork bere sentimenduak, pentsamenduak eta desirak modu asertiboan azalduz eta, aldi berean, besteen sentimenduak, pentsamenduak eta desirak modu aktiboan entzunez eta kontuan hartuz. | | Oharrak: |
| Taldean lan egiteko eta ikasteko gai izatea, eta nork bere ardurak bere gain hartzea eta lankidetzan jardutea, helburu komuneko zereginetan, askotariko pertsonak eta iritziak izateak berekin dakarren aberastasuna aintzat hartuz. | | Oharrak: |
| Modu aktiboan parte hartzeko eta lidergoa bere gain hartzeko gai izatea, eskolako zein eskolaz kanpoko testuinguruko ekimenetan. | | Oharrak: |
| Giza eskubideen araberako printzipio etikoekin eta bizikidetzarako oinarrizko gizarte ohituretatik eratorritako gizarte arauekin bat jokatzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| Gatazkak konpontzeko gai izatea, elkarrizketaren eta negoziazioaren bidez. | | Oharrak: |
| Dibertsitatea errespetatuz eta hari balioa emanez elkarbizitzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| 4. adierazlea: **Norbera izaten ikasteko konpetentzia: izaten jakitea.**<br>GEHko pertsona eta kolektiboek beren protagonismoa beren gain hartzea, desberdintasunak eragiten dituzten arrazoiei alternatibak biltzen banaka eta kolektiboan jardun dezaten, eta gizartea inplikatzeko eta mobilizatzeko gai izan daitezen [(H)ABIAN 2030].<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Nor bere pentsamendua eta ikasteko estilo kognitiboa autoerregulatzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| Nor bere gorputzaren funtzioak eta itxura autoerregulatzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| Nor bere emozioak autoerregulatzeko gai izatea. | | Oharrak: |

| | | |
|---|---|---|
| Nor bere jokabide morala autoerregulatzeko gaitasuna. | | Oharrak: |
| Nor bere erabakiak hartzeko eta eginbeharrak betetzeko motibazioa eta nahimena autoerregulatzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| Autoestimu positiboa eta errealista izateko gai izatea. | | Oharrak: |
| Erabaki pertsonalak hartzeko gai izatea eta nor bere erabakien eta eginbeharren ardura bere gain hartzeko gai izatea. | | Oharrak: |
| 5. adierazlea: **Ekimenerako eta espiritu ekintzailerako konpetentzia: egiten eta ekiten jakitea**<br>Pertsona eta kolektiboek ikaskuntza prozesuak abiaraztea, norberaren hezkuntza jardunbideetan oinarrituta, eta lortutako ikaskuntzak prozesu berrietan txertatzea eta partekatzea [(H)ABIAN 2030].<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek. | | |
| Ideia berriak eta konponbideak sortzeko gai izatea, bai eta errealitatea hobetzeko alternatibak proposatzea ere, izaera kritikoarekin, elkartasunarekin eta ardura sozialarekin. | | Oharrak: |
| Ekintza planifikatuak gauzatzeko eta, behar denean, doikuntzak egiteko gai izatea. | | Oharrak: |
| Gauzatutako ekintzak ebaluatzeko eta hobekuntza proposamenak egiteko gai izatea. | | Oharrak: |

**2. HELBURUA: HEZKUNTZA KOMUNITATEAREN GARAPENA ABERASTEA**

**Data:**

| | | |
|---|---|---|
| 1. Irakasleak | | |
| 1.1.Proiektuan parte hartzen dutenak | | |
| 1. adierazlea: **Inplikazioa**<br>Irakasleek proiektua gauzatzeko konpromisoa hartzea.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Tartean diren irakasleen kopurua.<br>*Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.* | | Oharrak: |
| Eskainitako lanordu kopurua. | | Oharrak: |
| Berariaz egindako bilera kopurua. | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Zeharkakotasuna**<br>GEHaren jardunbideetan GEHa eta Lankidetza helburu berarekin eta partekatutako gaiekin erlazionatzea [(H)ABIAN 2030].<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Tartean diren eta arte arloan espezializatuta ez dauden irakasleen kopurua. | | Oharrak: |
| Koordinazio bilera orokorrei eskainitako denbora. | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Konpetentziak/ezagutzak eskuratzea**<br>Irakasleek gaitasuna izatea konpetentziak eta ikaskuntza esanguratsua lortzea oinarri dituen ikaskuntza prozesu bat gauzatzeko.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Ikasleen testuinguru, kultura eta gaitasun dibertsitatea kontuan hartuta irakasteko prestakuntza izatea.<br>*Oharra: aztertu egingo dira irakasleek alderdi horri lotuta hautematen dituzten indarguneak eta ahulguneak.* | | |

| | | |
|---|---|---|
| Ikasleak ezagutzaren gizartean txertatzeko gai izatea.<br>*Oharra: hasierako diagnostiko bat egingo da, alderdi horren jarraipena egiteko, proiektuak dirauen artean.* | | |
| Kultura aniztasuna, demokrazia eta elkartasuna oinarri dituen herritartasun eredua oinarri hartuta irakastearen aldeko jarrera izatea. | | |
| 4. adierazlea: **Proiektuaren eragina, emozioei dagokienez**<br>Proiektuan parte hartzen duten irakasleek hari buruz duten sentsazio orokorra balioestea.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Proiektuak dirauen arteko gogobetetzea. | | |
| 1.2. Proiektuan parte hartzen ez dutenak | | |
| 1. adierazlea: **Sortutako interesa**<br>Proiektuak zer eragin izan duen hartan parte hartu ez duten irakasleengan.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Proiektuarekin bat egite berriak, prozesuak dirauen denboran. | | Oharrak: |
| Galderak/kontsultak/iruzkinak. | | Oharrak: |
| 2. Familiak | | |
| 2.1. Proiektuan parte hartzen dutenak | | |
| 1. adierazlea: **Inplikazioa**<br>GEHaren jardunbideek pertsona eta kolektiboen jarduna eta inplikazioa sustatzea, alternatiba jasangarri, solidario eta ekitatiboak abiarazteko [(H)ABIAN 2030.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Número de familias implicadas. | | Oharrak: |
| Proiektuari eskainitako ordu kopurua. | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Sortutako interesa**<br>Proiektuak zer eragin duen hartan parte hartu duten familiengan.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Proiektuarekin bat egite berriak, prozesuak dirauen denboran. | | Oharrak: |
| Galderak/kontsultak/iruzkinak. | | Oharrak: |
| Bilerei eskainitako denbora (orokorrei zein berariazkoei). | | Oharrak: |
| Aurkezpen ekitaldietara bertaratzea (halakorik balego). | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Parte hartzea**<br>Familien parte hartzea, proiektu eta ekintza kulturaletan.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | |
| Proiektuarekin bat egite berriak, prozesuak dirauen denboran. | | Oharrak: |
| Galderak/kontsultak/iruzkinak. | | Oharrak: |
| Bilerei eskainitako denbora (orokorrei zein berariazkoei). | | Oharrak: |
| Aurkezpen ekitaldietara bertaratzea (halakorik balego). | | Oharrak: |

| | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|
| 4. adierazlea: **Proiektuaren eragina, emozioei dagokienez**<br>Proiektuan parte hartzen duten familiek hari buruz duten sentsazio orokorra balioestea.<br><br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | | | | | |
| Proiektuak dirauen arteko eta proiektua amaitu osteko gogobetetzea. | 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | Oharrak: |
| 2.2. Proiektuan parte hartzen ez dutenak | | | | | | |
| 1. adierazlea: **Sortutako interesa**<br>Proiektuak zer eragin duen hartan parte hartu ez duten familiengan.<br><br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | | | | | |
| Aurkezpen ekitaldietara bertaratzea (halakorik balego). | | | | | | Oharrak: |
| Galderak/kontsultak/iruzkinak. | | | | | | |
| 3. Ikastetxea | | | | | | |
| 1. adierazlea: **Sortutako interesa**<br>GEHaren hezkuntza jardunbideak ikuspegi globala duten tokiko jardunak eta eskubideen ikuspegitik begiratutako tokiko garapenak izatea [(H) ABIAN 2030].<br><br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | | | | | |
| Izapidetutako matrikulazio berrien kopurua.. | | | | | | Oharrak: |
| Komunikabideetan plazaratutako argitalpenen kopurua. | | | | | | Oharrak: |
| Jasotako aintzatespenen kopurua. | | | | | | Oharrak: |
| Kanpotik egindako galdera/kontsulta/iruzkinen kopurua eta mota. | | | | | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Profesionalen sareak**<br>Profesionalen arteko sareak eratzea, proiektu bat gauzatzearen ondorioz.<br><br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | | | | | |
| Profesionalen foroetan egindako aurkezpenen kopurua | | | | | | Oharrak: |
| Profesionalen sareekin bat egite berrien kopurua. | | | | | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Hezkuntza lantaldearekiko eta familiekiko harremana**<br>Profesionalen lantaldearen eta familien inplikazio mailaren aurrerapena, ikastetxearen hezkuntza proiektuan.<br><br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | | | | | |
| Zenbat bilera eta/edo foro komun egin diren eta haien zer balioespen kualitatibo egin den, bai profesionalen lantalde osoarekin eta bai ikastetxearekin loturiko familiekin. | | | | | | |
| 4. adierazlea: **Artearen eta Kulturaren presentzia, ikastetxeko eguneroko bizitzan**<br>GEHaren jardunbideetan herritartasun globaleko alternatibak bilatzeko azterketa kritikoa egitea [(H)ABIAN 2030].<br><br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek eta zentroko zuzendaritza taldeak. | | | | | | |
| Ikasturteak dirauen artean aktibatutako ekimen artistikoen kopurua. | | | | | | Oharrak: |
| Hurrengo ikasturtean aktibatutako ekimen artistikoen kopurua. | | | | | | Oharrak: |
| Espazioari lotuta egindako esku hartzeen kopurua eta mota. | | | | | | Oharrak: |




**3. HELBURUA. TESTUINGURUA SENTSIBILIZATZEA, AINTZAT HAR DEZAN ZER GARRANTZI DUTEN ARTEEK, GIZARTE ERALDAKETARAKO HEZKUNTZA (GEH) GAUZATZEKO GILTZARRIETAKO BAT DIREN ALDETIK**

**Data:**

| | | |
|---|---|---|
| 1. Barrio | | |
| 1. adierazlea: **Parte hartzea**<br>Proiektuan parte hartu duten auzokoen, kolektiboen eta bestelako eragileen (merkatariak, enpresak, proiektua, etab.) parte hartzearen balioespen kualitatiboa eta kuantitatiboa.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileek. | | |
| Proiektuan parte hartu duten pertsonen kopurua. | | Oharrak: |
| Parte hartu duten pertsonen dibertsitatea.<br>*Oharra: adinari, generoari, jatorriari eta abarri loturiko dibertsitatea.* | | |
| Proiektuan parte hartu duten kolektiboen edo bestelako eragileen kopurua. | | Oharrak: |
| Proiektuan parte hartu duten kolektiboen eta eragileen izaera.<br>*Oharra: hemen aipatzen diren kolektibo edo eragileak dira, besteak beste, GGKEak, kultura eragileak, hezkuntza komunitatea, Berritzeguneak, unibertsitateak, komunikabideak, gizarte mugimenduak, kolektibo feministak, ekologistak, baztertutako herrietako kolektiboak, migratzaileen kolektiboak.* | | |
| 2. adierazlea: **Proiektuak auzoan duen presentzia**<br>Proiektua ikastetxetik harago zenbat zabaldu den auzoko beste espazio batzuetara, eta zer parte hartze maila izan duen auzoak ekimen horietan.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Auzoan (ikastetxetik kanpo) egindako ekintzen kopurua. | | Oharrak: |
| Espazioen tipologia (kultura guneak, espazio publikoa, dendak, etab.). | | Oharrak: |
| Espazio horietan egindako aurkezpenetara bertaratutako pertsonen kopurua (halakorik balego). | | Oharrak: |
| Aurkezpen horietara bertaratutako pertsonen dibertsitatea<br>*Oharra: adinari, generoari, jatorriari eta abarri loturiko dibertsitatea.* | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Norbanakoaren eta taldearen eraldaketa**<br>Parte hartzen duten pertsonek eta kolektibo edo eragileek gizarte eta bizitza alternatiba berriak aintzat hartzea eta bilatzea.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Parte hartzen duten pertsonek gizarte eraldaketarako emaitzen bilaketan eragina duten gaien inguruan duten ikuspegiaren bilakaera.<br>*Oharra:jarraian, alderdi horietako batzuk aipatuko dira, baina komeni da eragile bakoitzak balioestea, prozesuaren hasieran, zein diren bere proiektura gehien egokitzen direnak, bere lanari ahalik gehien doitutako ebaluazioa egiteko.*<br>• *Botere harremanak.*<br>• *Dibertsitatearen kudeaketa (izan dibertsitate funtzionala, kulturala, soziala, generoari dagokiona, sexu orientazioari dagokiona, etab.)..*<br>• *Gatazken kudeaketa.*<br>• *Giza Eskubideen kontzientzia hartzea.*<br>• *Genero ikuspegiaren kontzientzia hartzea.*<br>• *Garapen jasangarriaren kontzientzia hartzea.* | | |
| Parte hartzen duten kolektiboen edo eragileen lan prozeduretan, estatutuetan, egitekoan edo oinarrietan egindako aldaketak. | | |

| 2. Hiria | | |
|---|---|---|
| 1. adierazlea: **Parte hartze kulturala**<br>Proiektua egiten den auzoaren kultura ohituren bilakaera eta proiektuak hiriaren kultura bizitzan duen eragina.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak, inplikatutako kultura eragileak eta proiektuaren eraginpeko beste eragile batzuek (datu emaile diren aldetik, gehien gehienetan). | | |
| Auzoko zenbat pertsona matrikulatu diren tokiko erakundeen bultzadarekin hiriko beste espazio batzuetan egindako arte edo kultura ekintza hezitzaileetan.<br>*Oharra: datu hau eskuratzeko, hirugarrenen lankidetza behar da, tokiko erakundeena, batez ere, eta, horregatik, komeni da datu bilketa hau udal mailako estrategia baten parte izatea eta, beraz, aztergai den proiektutik harago joatea.* | | Oharrak: |
| Auzoko zenbat pertsonak hartzen duten parte udalaren arte edo kultura programazioetan, tokiko erakundeen bultzadarekin hiriko beste espazio batzuetan egindakoetan.<br>*Oharra: datu hau eskuratzeko, hirugarrenen lankidetza behar da, tokiko erakundeena, batez ere, eta, horregatik, komeni da datu bilketa hau udal mailako estrategia baten parte izatea eta, beraz, aztergai den proiektutik harago joatea.* | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Inplikazioa**<br>Tokiko erakundeek eta hiriarekin loturiko eragileek proiektuarekin duten konpromisoa.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak eta inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Tokiko erakundeek proiektura bideratutako baliabide ekonomikoak (bestelako baliabideak ere izan daitezke). | | Oharrak: |
| Hiriarekin loturiko bestelako eragileek proiektura bideratutako baliabide ekonomikoak (bestelako baliabideak ere izan daitezke).<br>*Oharra: bestelako eragileak aipatzen ditugunean, tokiko erakundeen parte ez den eta bere jarduna proiektuaren testuinguruan garatzen duen edozein pertsona fisiko edo juridiko aipatzen dugu.* | | Oharrak: |
| Proiektua haren garapeneko uneren batean bertatik bertara ezagutu duten tokiko agintarien edo bestelako eragileen ordezkarien kopurua.<br>*Oharra: bertatik bertara ezagutzea proiektuari loturiko bilera, aurkezpen edo fororen batera bertaratzea da, besteak beste.* | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Arte Hezkuntza babestea**<br>Proiektuak zer eragin duen Arte Hezkuntzari lotutako tokiko ekimen berrien aktibatzean edo lehendik diren lan ildoen finkatzean.<br>Nork betetzekoa: proiektuari lotutako irakasleek, zentroko zuzendaritza taldeak, inplikatutako kultura eragileak eta proiektuaren eraginpeko beste eragile batzuek (datu emaile diren aldetik, gehien gehienetan). | | |
| Zenbat diru laguntza edo programa berri bideratu diren tokiko Arte Hezkuntza proiektuak babesteko.<br>*Oharra: sektore publikoak zein pribatuak bultzatutako diru laguntzak edo programak izan daitezke.* | | Oharrak: |
| Tokiko arte hezkuntzako proiektuak laguntzeko diru laguntza edo programa horietarako proposamenak aurkezten dituzten eragileen kopurua eta tipologia.<br>*Oharra: eragileen tipologia aztertzeko, zer forma juridiko duten eta zer lan esparrutan diharduten (kultura, gizartea, hezkuntza, etab.) hartuko da kontuan.* | | Oharrak: |
| Zer baliabide ekonomiko bideratzen diren, diru laguntza edo programa horietara.<br>*Oharra: sektore publikotik zein pribatutik bultzatutakoak baliabide ekonomikoak eta/edo, ekimen sortu berriak ez direnean, haien bilakaera (gorakorra, beherakorra edo aldaketarik gabea)..* | | Oharrak: |

| | | |
|---|---|---|
| Diru laguntza edo programa horrek Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzarekin duen koherentzia maila.<br>*Oharra: (H)ABIAN estrategian jasotako GEHren 6 elementu nagusiak hartuko dira erreferentziatzat: subjektu protagonistak, ikuspegi politiko pedagogikoak, eskubideen ikuspegia, tokiko-global ikuspegia, agenteen arteko erantzunkidetasuna eta ikaskuntza kultura.* | | Oharrak: |
| Hiriko beste ikastetxe batzuetan Arte Hezkuntzari lotuta aktibatutako proiektuen kopurua eta ezaugarriak.<br>*Oharra: kopuruaz gain, funtsezkoa da abian jarritako proiektu horien tamaina aztertzea, hots, haien iraupena, haietara bideratutako baliabideak (baliabide ekonomikoak eta materialak, giza baliabideak, etab.), finantzazio iturriak, gai nagusiak, (H)ABIAN 2030 estrategiarekiko lotura, etab.* | | Oharrak: |
| 3. Kultura sektorea (tokikoa) | | |
| <u>1. adierazlea:</u> **Testuinguruko kultura eragileen arteko harremanak**<br>Proiektuak zer eragin duen testuinguruko kultura eragileen arteko harremanetan eta haiek Arte Hezkuntzan duten jardueran.<br>Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Proiektuan parte hartu duten tokiko kultura eragileen kopurua. | | Oharrak: |
| Inplikatutako eragilearekin aurrez lanik egin ez duten tokiko zenbat kultura eragilek parte hartu duten proiektuan. | | Oharrak: |
| Inplikatutako eragilearekin aurrez lan egin izan duten tokiko zenbat kultura eragilek parte hartu duten proiektuan. | | Oharrak: |
| Besteekin sarean egindako lanaren balioespena. | | Oharrak: |
| Proiektu hau abiapuntu izanik, zenbat proiektu jarri diren martxan, beste eragile batzuekin lankidetzan. | | Oharrak: |
| Zenbat profesionalen topagune, foro edo elkarte bultzatu dituzten tokiko kultura eragileek, Arte Hezkuntzaren inguruan. | | Oharrak: |
| <u>2. adierazlea:</u> **Arte Hezkuntzan izandako eragina**<br>Tokiko kultura eragileek Arte Hezkuntzarako proiektuak abian jartzea.<br>Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak eta proiektuaren eraginpeko beste eragile batzuek (datu emaile diren aldetik, gehien-gehienetan). | | |
| Proiektuan parte hartu duten tokiko kultura eragileetatik zenbatek jarri dituzten abian Arte Hezkuntzako proiektu berriak, beren kasa. | | Oharrak: |
| Zer baliabide (ekonomikoak, materialak, giza baliabideak, etab.) bideratu diren Arte Hezkuntzako proiektu horietara. | | Oharrak: |
| Zer eragin izan duten proiektu horiek, antolakuntza mailan, inplikatutako egituretan.<br>*Oharra: hainbat alderdi aztertuko dira, hala nola konpetentzia berrien lorpena, antolaketa aldaketak, kontratazio aukerak eta beharrak, lan ildo berrien sorrera, etab.* | | Oharrak: |
| Zer koherentzia maila duten proiektu horiek GEHrekin.<br>*Oharra: (H)ABIAN estrategian jasotako GEHren 6 elementu nagusiak hartuko dira erreferentziatzat: subjektu protagonistak, ikuspegi politiko pedagogikoak, eskubideen ikuspegia, tokiko-global ikuspegia, agenteen arteko erantzunkidetasuna eta ikaskuntza kultura.* | | Oharrak: |



### 4. HELBURUA. PROIEKTUAN INPLIKATUTAKO KULTURA ERAGILEAK INDARTZEA

**Data:**

| | | |
|---|---|---|
| 1. adierazlea: **Giza baliabideak**<br>Proiektuaren eraginaren azterketa, hari lotutako profesionalei dagokienez.<br>Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Zenbat profesionalek parte hartu duten proiektuan eta zer egiteko izan duten, proiektuaren antolakuntzari zuzen-zuzenean lotuta.<br>*Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.* | | Oharrak: |
| Zenbat profesional kontratatu dituen inplikatutako eragileak proie-kturako, beren-beregi, eta zer egiteko izan duten<br>*Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.* | | Oharrak: |
| Zenbat profesional kontratatu diren proiektuaren garapena dela eta (ez proiektua gauzatzeko).<br>*Oharra: bereizi egingo dira mutilen eta nesken kopuruak.* | | Oharrak: |
| Zer konpetentzia edo ezagutza eskuratu dituzten proiektuan parte hartu duten profesionalek, haren garapena dela eta.<br>*Oharra: inplikatutako eragilearen lantaldeko profesionalen konpetentzia lorpenak aztertuko dira; gaitasun eta ezagutza horiek proiektutik haragokoak izan daitezke, proiektuaren aktibazioarekin zuzen-zuzenean lotuta eskuratu badira, betiere (esate baterako, aspalditik egin nahi izan ziren prestakuntzak badira, baina ez bada horiei ekiteko erabakirik hartu proiektua abian jarri arte).* | | Oharrak: |
| Eraldaketa pertsonala eta antolakuntzakoa.<br>*Oharra: proiektuak zer eragin duen neurtuko da (bai eta parte hartu duten pertsonek zer balorazio kualitatibo egin duten ere), hainbat alderdi kontuan hartuta, hala nola gatazken kudeaketa, entzuteko eta komunikatzeko gaitasuna, taldeko lana, sormena, gardentasuna, pentsamendu kritikoa, ezagutzen transferentzia, inplikazioa eta proaktibitatea.* | | Oharrak: |
| 2. adierazlea: **Oihartzun publikoa.**<br>Proiektuan inplikatutako eragilea ikusaraztea, foro profesionaletan zein maila orokorrean.<br>Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Zenbat argitalpen eta zer motatakoak plazaratu diren komunikabi-deetan, proiektuari lotuta.<br>*Oharra:komunikabide orokorrak zein espezializatuak hartuko dira kontuan.* | | Oharrak: |
| Zenbat argitalpen eta zer motatakoak plazaratu diren komunikabi-deetan, proiektuari lotu gabe.<br>*Oharra:komunikabide orokorrak zein espezializatuak hartuko dira kontuan, eta hizpide dugun proiektua egin aurretik jasotako arretarekin alderatuko da.* | | Oharrak: |
| Proiektuari edo inplikatutako eragileari lotutako sare sozialen bi-lakaera.<br>*Oharra: alderdi kuantitatiboak (jarraitzaileak, ikustaldiak, etab.) zein kualitatiboak (elkarrekintza mota, haien interesa, etab.) hartuko dira kontuan.* | | Oharrak: |
| Inplikatutako eragileari lotutako sare sozialen bilakaera.<br>*Oharra: alderdi kuantitatiboak (jarraitzaileak, ikustaldiak, etab.) zein kualitatiboak (elkarrekintza mota, haien interesa, etab.) hartuko dira kontuan.* | | Oharrak: |

| | | |
|---|---|---|
| Zenbat aintzatespen jaso diren proiektuari lotuta. | | Oharrak: |
| Zenbat eta zer motatako gonbidapenak jaso diren, proiektua foroetan aurkezteko. | | Oharrak: |
| Zenbat eta zer motatako kanpoko harremanak izan diren (galderak, kontsultak edo iruzkinak), proiektuari lotuta.<br>*Oharra: sare sozialetan egindakoak ez diren harremanak hartuko dira kontuan (halakoak aztertzeko berariazko atal bat baitago).* | | Oharrak: |
| 3. adierazlea: **Inplikatutako eragilearen eraldaketa**<br>Proiektuak inplikatutako erakundearen jarduera ildoen dibertsifikazioan izan duen eraginaren azterketa, bai eta lan ingurunean izandakoa ere (profesionalen sareak, elkarteak, etab.).<br>Nork betetzekoa: inplikatutako kultura eragileak. | | |
| Zenbat eta zer motatako lan ildo berriak aktibatu diren, proiektua egin eta gero. | | Oharrak: |
| Zer itzulkin ekonomiko ekarri duten lan ildo horiek. | | Oharrak: |
| Profesionalen sareekin edo kolektiboekin bat egite berrien kopurua.<br>*Oharra: hizpide den proiektuan landutako esparruei lotutako sareak eta kolektiboak hartuko dira kontuan, bai eta aktibatutako lan ildo berriei lotutakoak ere.* | | Oharrak: |



## 5. HELBURUA. PROIEKTUAREN ERAGILE BULTZATZAILEARI AURREKONTUEN EGONKORTASUNA LORTZEN LAGUNTZEA

**Data:**

| 1. adierazlea: **Baliabide ekonomikoak**<br>Proiektuaren irakurketa ekonomikoa, aurrekontu eta estrategia mailan.<br>Nork betetzekoa: eragile bultzatzaileak | | |
|---|---|---|
| Proiektuaren guztiko aurrekontua.<br>*Oharra: proiektuak sortutako gastuak eta sarrerak, bi-biak, hartuko dira kontuan; azterketa kuantitatiboa eta kualitatiboa egingo da.* | | Oharrak: |
| Aurrekontuaren dimentsioa, eragile bultzatzailearen guztizko funtsekin alderatuta. | | Oharrak: |
| Proiektuaren finantzazio iturrien dibertsitatea. | | Oharrak: |
| Aurrez eragile bultzatzailearekin loturaren bat duten zenbat eta zer motatako eragileek babestu duten proiektua ekonomikoki. | | Oharrak: |
| Aurrez eragile bultzatzailearekin loturarik ez duten zenbat eta zer motatako eragileek babestu duten proiektua ekonomikoki. | | Oharrak: |
| Zer itzulkin ekonomiko lortu duten, zuzenean, proiektuan parte hartu duten edo hura garatu den tokiko testuinguruko eragileek.<br>*Oharra: azpikontratazioak, proiektuak antolatutako ekitaldiek eragindako negozioak, etab. hartuko dira kontuan; informazio hori lortzea zaila izan daitekeenez, proiektuak eragindakoek zenbatespen ekonomikoa eta balorazio kualitatiboa egitea lehenetsiko da.* | | Oharrak: |
| Zer itzulkin ekonomiko lortu dituen eragile bultzatzaileak, hizpide dugun proiektua gauzatzea dela eta.<br>*Oharra: ez dira kontuan hartuko proiektuaren baitan lortutako sarrerak, hura egin ostean lortutako itzulkin ekonomikoa baizik; ildo horretatik, aztertu egingo da zer erabilera ematen dion antolakuntzak itzulkin horri, bai eta beste lan ildo batzuen bideragarritasunean edo aktibazioan duen eragina ere.* | | Oharrak: |





## Erreferentzia bibliografikoak

Aguirre, I. (2005) *Teorías y prácticas en Educación Artística*. Octaedro/EUB eta Nafarroako Unibertsitatea. Bartzelona.

Cilleruelo, L.; Peña, M.; Aberasturi-Apraiz, E. (2016) ¿Por amor al arte? Y otros monstruos contemporáneos. *Arte y Políticas de Identidad: Culturas de creatividad* aldizkarian, 14. alearen 11.-15. orrialdeetan (2016ko uztaila). Servicio de Publicaciones de la Universidad de Murcia. Murtzia.

Cuenca López, J.M.; Estepa Jiménez, J.; Martín Cáceres, M.J. (2011). El patrimonio cultural en la educación reglada. *Patrimonio Cultural de España* aldizkarian, 5. alean, 45.-58. orrialdeetan. Hemendik hartua: http://rabida.uhu.es/dspace/bitstream/handle/10272/9437/El_patrimonio_cultural.pdf?sequence=2 a 29/05/19.

236/2015 DEKRETUA, abenduaren 22koa, Oinarrizko Hezkuntzaren curriculuma zehaztu eta Euskal Autonomia Erkidegoan ezartzen duena (EHAA, 2016-01-15).

Efland, A.; Freedman, K.; Stuhr, P. (2003) *La educación en el arte posmoderno*. PAIDÓS argitaletxea. Bartzelona.

Eisner, E (1972) *Educar la visión artística*. PAIDÓS argitaletxea. Bartzelona.

Guzmán, B. (2018) *Arte, Educación y Desarrollo, la educación artística en el ámbito socio-educativo vasco*. UNESCO Etxea, Lan koadernoak, 3. zenbakia.

(H)ABIAN 2030, Gizarte Eraldaketarako Hezkuntzaren (GEH) euskal Estrategia. Hemendik hartua, 2019ko ekainaren 20an: https://www.elankidetza.euskadi.eus/contenidos/informacion/inf_habian/eu_def/adjuntos/(H)ABIAN%202030_%C3%BAltimo_borrador-eus.doc

Haanstra F.; Schönau D.W. (2007). Evaluation Research in Visual Arts Education. Hemendik hartua: Bresler L. (argit.) International Handbook of Research, *Arts Education. Springer International Handbook of Research in Arts Education*, 16. alea. Springer, Dordrecht.

HEZIBERRI 2020: OINARRIZKO HEZKUNTZAKO CURRICULUMAREN IKUSPEGI OROKORRA Hemendik hartua: https://www.euskadi.eus/contenidos/informacion/heziberri_2020/eu_2_proyec/adjuntos/OH_curriculum_osoa.pdf

Fundación Instituto de Ciencias del Hombre (datarik gabe) *La evaluación educativa: conceptos, funciones y tipos*.

International Society for Education Through Art. Hemendik hartua, 2020ko urtarrilaren 5ean: https://www.insea.org/node/570

Lorena, B.; Verján, V. (2000). El arte: factor determinante en el proceso educativo. *Educar* aldizkarian, 15. alean, 56.-65. orrialdeetan. Hemendik hartua: http://www.quadernsdigitals.net/datos_web/articles/educar/numero15/arte.htm.

Marín, R. (Koord.) (2003 ) Aprender a dibujar para aprender a vivir. *Didáctica de la Educación Artística para Primaria*. Pearson Education argitaletxea. Madril.

Montaño Arias, D. (datarik gabe) *La evaluación educativa: conceptos, funciones y tipos*. Hemendik hartua, 2020ko maiatzaren 19an: https://www.researchgate.net/profile/Domingo_Montano3/publication/328433428_Detection_analysis_of_electrophoretic_cryptic_variation_with_thermostability_in_isozymes_of_esterase's_in_Drosophila_melanogaster/links/5bdb6a13299bf1124fb402ed/Detection-analysis-of-electrophoretic-cryptic-variation-with-thermostability-in-isozymes-of-esterases-in-Drosophila-melanogaster.pdf

Lan Koadernoak UNESCO Etxearen argitalpen sorta bat dira, eta kulturari, garapenari eta gizarte eraldaketarako hezkuntzari loturiko gaien hausnarketa egitea eta gai horiek zabaltzea du helburu.




Mundu akademikoko eta gizarte-arloko zenbait pertsona ospetsu eta hainbat elkarte –gobernu artekoak eta gizarte zibilekoak– lanean ari dira aspalditik kulturak garapenean izan dezakeen eginkizunean modu teorikoan sakontzeko, baita horren aplikazio praktikoa sustatuko duten ekintzetan sakontzeko ere. Argitalpen hau kulturaren eta garapenaren arloan dauden ekimen ugariei gehitu nahiko genieke; hartara, binomio hori aipatzen denean zertaz ari garen jakin nahi duen orori gaira hurbiltzeko tresna bat eskainiko diogu.

Lan koadernoak, 1. zk.
Egilea: Maider Maraña
Urtea: 2010
Hizkuntzak: gaztelania, euskara eta ingelesa.

UNESCO Etxea
Lan koadernoak. 2. zk.
Ondarea eta
Giza Eskubideak
Nazio Batuek kultura-ondarearen arloan egindako lana, parte-hartzearen eta generoaren ikuspegitik
Maider Maraña

Lan honek lehen hurbilketa bat egiten du, ikusteko ea zer trataera duten giza eskubideek kulturaren arloko nazioarteko hitzarmenetan (ondarearen arlokoan, batez ere) eta Nazio Batuen (batez ere, UNESCOren) beste dokumentu eta aldarrikapen batzuetan, eta, hala, ikusteko ea eskubideen ikuspuntutik heldu zaion kultura ondareari, izaera unibertsal argia duten araudi horien ezarpenean.

Lan koadernoak, 2. zk.
Egilea: Maider Maraña
Urtea: 2015
Hizkuntzak: gaztelania, euskara eta ingelesa.




Ikerlan honek hainbat definizio proposatzen ditu arte hezkuntza kontzeptuari loturik, argi erakusteko zer garrantzi duen eta zer onura eragiten dizkion giza garapenari. Hezkuntzaren egungo euskal legea oinarritzat hartuta, hezkuntza sisteman zer presentzia duen deskribatzen du, bai eta curriculumak arteari loturiko irakasgaietan zer helburu dituen ere. Horrez gain, hainbat hezkuntza proiektu eta esperientzia artistiko zein kultural aurkezten ditu, Euskadiko hezkuntza sistemaren barruan zein kanpoan lanean dihardutenak.

Lan koadernoak, 3. zk.
Egilea: Begoña Guzmán Sánchez
Urtea: 2018
Hizkuntzak: gaztelania (testu osoa) eta euskara (laburpena).

Bertsio digitalak: http://www.unescoetxea.org













